albero. El brindis fue la puntilla para Carlos Abedulillo. El diestro se aproximó a la Presidencia, y con la castiza teatralidad torera exclamó: " Por usted virrey, por sus españoles cojones".

Carlos Abedulillo comenzó a sentir como todo su flujo sanguíneo se precipitaba hacia los testículos como un tsunami devastador que le fuera privando del riego a otras zonas del organismo. Fue perdiendo color al tiempo que se le alzaba el pendón. Nadie se dio cuenta de lo que sucedía porque todo el coso permanecía embebido en las magistrales evoluciones del matador sobre la arena. Todo eran oles enfebrecidos mientras el virrey de España en Vascongadas colapsaba por un shock multi orgásmico.. Al tiempo que la espada penetraba hasta la empuñadura hasta el lugar preciso en una estocada mortal de necesidad, el virrey se desplomaba sobre la bancada. Cuando tras los primeros segundos de incertidumbre lograron colocarlo de cúbito supino se encontraron con un cuerpo inerte que lucía una sonrisa entre " Ecce Homo" y " Bonono" salido, con una abultadísima prominencia entre las partes denominadas "nobles" según el Manual de Urbanidad de las Nuevas Generaciones. Era tal la protuberancia que ostentaba que un crítico taurino comentó que habría hecho falta un toldo de circo para hacerle una taleguilla. Evidentemente que el malagueño exageraba, pero el espectáculo en verdad que resultaba circense.

No pasó por la enfermería del coso y fue trasladado de inmediato al Hospital Civil de Basurto, a la sazón el más próximo a la plaza de toros de Vista Alegre. Allá consiguieron estabilizarle y rebajar los niveles de testosterona hispánica lo que se manifestó en un notorio descenso de la hinchazón ya referida. Lo que resultó imposible corregir fue la estólida sonrisa de primate que,

por lo que dijeron algunos especialistas faciales sería irreversible y vitalicia. Al poco, fue lo de las reuniones de los responsables de salud, las dos ruedas de prensa ofrecidas y la oportuna decisión de trasladarle al hospital madrileño "12 de octubre" para que allá se sintiera como en casa.

Han pasado ya cuatro meses desde entonces y nadie ha sabido aún dar una explicación científica al fenómeno. Se habló de llevarle a un prestigioso hospital de Londres, pero Abedulillo se negó por no dar bazas a los colonialistas de Gibraltar. Unas recientes declaraciones del primer ministro británico asegurando que por encima de la territorialidad está la libre decisión de los ciudadanos fue el motivo por el que se cerrara en banda ante la posibilidad de ser tratado en el Reino Unido. Para Carlos Abedulillo, semejantes proclamas eran constitutivas de colaboración con el mundo proetarra se pronunciaran en euskara o en Inglés. A pesar de su delicado estado de salud, estuvo tentado de llevar el caso a la Audiencia Nacional aunque su colega el ministro de Asuntos Exteriores le retuvo a tiempo con el argumento de que suficiente chanza recorría ya Europa como para seguir jodiendo más la "marca España", que al paso que iba la cosa acabaría sirviendo para poco más que para marchamo o chapa de chorizos.

Evidentemente, Carlos Abedulillo ya no es el virrey de España en las vascongadas. En gratitud por los servicios prestados a la patria en tierra hostil, le fue concedida una medalla con cinta piperpoto, remunerada. Como la dotación económica era demasiado frugal por cuestiones derivadas de la crisis económica, el Consejo de Ministros reunido en la Moncloa el tercer viernes de Octubre acordó por unanimidad concederle plaza de gorrilla en el Valle de los Caidos.

El pasado 20 de noviembre pudo ser fotografiado en su puesto de trabajo. La sonrisa que lucía en su careto no parecía corresponderse con los tristes acontecimientos que recuerdan el lugar y la fecha.

Precisamente por esa llamativa falta de sincronía entre evento y expresión, un nutrido grupo de falangistas de Murcia le propino una monumental paliza y lo tiró abajo por las escalinatas de piedra. Pensaron, muy equivocadamente, que aquel extraño individuo se estaba tomando a chirigota el sagrado lugar y a sus padres y mártires de España. De ahí brotó el juvenil, sano y espontaneo gesto de propinarle un severo correctivo por rojo indecente. Tuvo que ser internado para repararle tres costillas y una abolladura en el pómulo izquierdo. Ni con la intervención fue posible corregirle la estúpida sonrisa. Era como si el sarcasmo persiguiera al virrey incluso tras haber dejado de serlo.
Así de extraño fue el caso del virrey en Vascongadas

*Alhamako kartzelan 2013ko abuztuan*



**Ibon Muñoa Arizmendiarrieta**
1958
Eibar

Atxilotze data: 2000ko urriaren 17an.
Liburu bat argitaratua dauka:
"*Ametsen txokoan bizi naiz*". 2011. Ataramiñe.



C.P. Puerto I
Ctra. Jerez-Rota, km. 6,4
Apdo. 555
11500 Puerto de Santa Maria
Cadiz

## Kartzelari xake-mate emango diogu

1
Errepublika zaigu
hurbildu jokora,
erregeak taulatik
bidali kanpora,
zirto hau ekarri dut
"xakeko" arlora,
monarkak sartu ditut
kutxan hankaz-gora.

2
Xake-jokoa dago
pil-pil etxartean,
zoriontsu gabiltza
gu xake-matean,
kirolaren aurretik
edota ostean,
kideak ari gara
laukien artean.

3
Burutik zaizun arren
ateratzen kea,
gerra baino jokoak
pizten du bakea,
taulan errotu dugu
eremu askea,
kideen sentimendu
ederren trukea.

4
Mahaian jarri gara
grina berarekin,
denbora gozatzeko
xede onarekin,
zu hasi zuriekin
eta ni beltzekin,
kartzelak ahaztuko
ditugu piezekin.

5
Erregina laga dut
erregea zaintzen,
peoiekin dihardut
taktika prestatzen,
zaldiak trostan dauzkat
zuzen erasotzen,
alfilak zein dorreak
atzetik bultzatzen.

6
Eskuak luzatzea
keinu adierazle,
amaitu da partida
biok irabazle,
xake-jokoa ez da
irrien ebasle,
baizik eta kideen
pozaren arazle.

7
Gatazkari diogu
eman xake baikor,
konponketa zuzenki
ehuntzeko bizkor,
erabaki hau denez
guretzat emankor,
kartzelak hautsez dira
bihurtuko galkor.

8
Partida bat jokatu
zeuri eskaintzeko,
erregea bentzutu
zu loriatzeko,
xake-jokoan daukat
beta pentsatzeko,
elkartuko garela
maitez sentitzeko.

*2013ko martxoaren 24an*

## Hiru desira eta sentimendu bat negu gorrian

Neguko ilunabarrean
ipar haizearen menpean
hotz dagi presoaren ziegan,
berdin txiroaren txabolan,
eta zarpailaren zokoan,
uzkurtuta dagite amets
lar sufritzen ari direnak.
Aukera bat nahi du presoak
hesia bihur dadin ate,
justizia nahi du txiroak
txabola bihur dadin etxe,
errukia nahi du zarpailak
kartoia bihur dadin ohe.
Gazte sentimentalak dio
"buka dadila gabezia
onura haz dadin Munduan",
udaberrian entzun nahi du
txiolari txantxangorria,
esperantzaren irrintzia.

*2013ko apirilaren 7an*

## Kartzelak hil duen kide bati

Mendeku zitalaren sarean erorita
botereak gupida gabe iraindu zaitu,
krudelkeria pairatu behar izan duzu
zure herria oro maitatu duzulako,
ospitale batean bakarrik hil egin zara
esku maitagarrien babesa ukatuta,
gelako atean polizia batzuk daude
ezin ulertu barik konpromiso itzela,
aberriari eskaini diozu bizitza
jendarte maiteñoa hobetzeko musu-truk,
ez duzu egun handia plazan gozatuko,
gurekin gozoro biziko zara ordea,
Auñamendin egunsenti oskarbietan,
Kantauri itsasoan arrats oskorrietan,
zelaian lili usaintsuen petaloetan,
jaioki diren ume askeen taupadetan.

*2013ko apirilaren 7an*

## Oraingo negu gordinak leunduko dira

1
Udazkena badoa
badator negua,
izan dadila, otoi,
gurekin malgua,
"ez dut gura ospelik"
ohi da erregua,
kartzelan ez dadin has
ozen ernegua.

2
Neguan jipoitzen nau
kartzela okerrak,
laiotzak direlako
hemengo bazterrak,
izozgailu handi bat
dirudi tailerrak,
halaber kiroldegi
umel eta lerrak.

3
Andaluzian ei da
ikur eguzkia,
neguak baina dakar
tamalez flakia,
sukarrak duenean
jotzen bekokia,
dardarka datza soilik
ziegan gizakia

4
Puerton uzkur gabiltza
hotzaren garaian,
denbora darabilgu
berotzeko nahian,
kalean eguna zen
joaten ezarian,
kartzelan txepel doa
arima erian.

5
Negutean hotz dagi
ziega txikietan,
izoztuta geratzen
zara iluntzetan,
aterpea bilatzen
duzu izaretan,
gustagarri zaizkizun
amets askeetan

6
Elkartasunak digu
negua leuntzen,
bihotza laztanduta
gogoa gozatzen,
etxartean kideok
garenean batzen,
bisitak zein gutunak
ditugu eskertzen.

7
Putzu beltzean ditut
gorriak ikusten,
berogailurik gabe
eztulka naiz hasten,
maitasunari esker
hotza dut jasaten,
naro dit behar dudan
kemena ematen.

8
Atsegin zait zurekin
hotzari eustea,
"zoritsu bizi gara"
garbi entzutea,
etxean goxo-goxo
zeuri esatea,
"opari bat izan da
gaurko elurtea".

*2013ko apirilaren 14an*

## Biharko urte handiarena

Aurtengoa kide izango da
niretzat hamahirugarrena,
sinetsi nahi dut izango dela
kideontzat zeozerena,
seguru asko ez da izango
nahi dugun zohardiarena,
baina bai gure goiztiri hori
hasten lagunduko duena.
Urte hau ziur izango dela
zeurea eta besteena,
horrela gero iritsiko da
dirdaiki gainerakoena,
deserrietan urruti gauden
euskaldun sentimentalena,
Ama-Lurraren euskara maitez
laztanduko dugunarena.

Orduan hor da dena hasiko,
gutarrek espero zutena,
galtzailerik ez duen izango
garaipen kolosalarena,
pobreziarik ezagutuko
ez duen auzolanarena,
herrarik gabe hedatuko den
giza eskubidearena.
Urte hori da izango uros
gure askatasunarena,
zuk eta denok itxoiten dugun
egun zoragarriarena,
bortxarik gabe on biziko den
euskotar jendartearena,
maiteñoei oparituko
diegun irriñoarena.

*2013ko maiatzaren 19an*

## Geure idazleen aldeko dei bat

1
Kontzientzia enegarrenez zaizu kexatu,
nortasun bihurria nahi zenuke bezatu,
ez dadin axolagabe kultura gezatu,
besaulkian zara eserita erlaxatu,
ohiko nagikeria txarra duzu xaxatu,
literatura euskaraz oparo gozatu.

2
Gure idazleak hasi zara gerizatzen,
itzultzaileen langintza gozoro pusatzen,
ele maitea diharduzu eder usatzen,
nonahiko istorioak gogoan pausatzen,
euskal unibertsoa hola zaude osatzen,
Etxepareren aldarria bikain gauzatzen

*2013ko maiatzaren 19an*

## Untzagan elkartzen ginenean

1
Euriarekin oroit naiz
agertzen zinenean,
irriño bat marraztuta
aurpegi leunean
Isasitik jaisten zinen
gabardina soinean,
Untzagan zure zain dontsu
egoten nintzenean.

2
Taberna batean ginen
jartzen goxo txokoan,
zerbait afaltzen genuen
bare hango giroan,
gure planak genegitzan
gustura jandakoan,
zoritsu egoten nintzen
maite, zure alboan.

3
Guk ez genuen sentitzen
hotzik negu gorrian,
eskutik samur helduta
iluntze hozkirrian,
arnas lurruna hasten zen
poliki aldarrian,
"gu gabiltza" genioen,
"modu zoragarrian!"

4
Zu eta ni bizi ginen
bikain iraganean,
gu mementu hartan geunden
xarmaren larrainean,
horixe baieztatzen dut
ziegan nagoenean,
goiz-argian maiteminez
esnatzen naizenean.

5
Izar denak egon arren
erabat estalita,
gau beltzuria zitzaigun
iruditzen polita,
alai genbiltzan batera
ilusioz jantzita,
aterkitik euri tantak
erortzen ikusita.

6
Iretargia borobil
ateratzen zenean,
luzaro egoten ginen
agurtzeko unean,
bihotzak zebiltzan gertu
taupaka gau-minean,
amandrearen distira
jasotzen zutenean.

7
Besarkatuta gozoro
gaueko soseguan,
entzuten genuen hontza
uluka inguruan,
artizarra keinuka zen
pizten dir-dir orduan,
bere grazia eskainiz
ortziaren ortuan.

8
Gure Untzagako plazan
ginelako elkartzen,
zurekin atseginez naiz
oroitzan kulunkatzen,
askapenaren zuhaitza
hasi gara kimatzen,
gerezia onduko da
has gaitezke ospatzen.

*2013ko ekainaren 9an*

## Kide irribarretsu bati esker onez

1
Ate baten kirrinka,
hasi da eguna,
irteteko prest dago
kideko hiztuna
begiak pozten zaigu
egin ezaguna,
bere alboan pena
dirudi biguna,
suspertzen du etsita
dagoen urguna.

2
Urte asko darama
herritik kanpora,
borrokan erori zen
gatibu zulora,
kartzelan usatu du
ganoraz denbora,
euskara ikasita
egin dezan gora,
euskaldun helduko da
zoritsu txokora.

3
Bere umorea da
zinez kutsakorra,
arlo askotan baita
horrela motorra,
erabat lautu digu
aldapa gogorra,
irribarreaz blaitu
kartzela lehorra,
inguru ezkorra du
bihurtu baikorra.

4
Txantxekin murrizten du
kartzelan laharra,
zirtoekin argitzen
etxarte nabarra,
herriminak duenez
zeharkatzen marra,
adorea eskaintzen
digu barra-barra,
gau beltzean dirdai da
amandre zaharra.

5
“Bizipoz barik” dio
“ez dago biderik,
ezta ere tamalez
geroko xederik,
kide denok batuta
badago eusterik,
hola ez duzu hemen
izango ajerik”
berari esker ez dut
izaten nekerik.

6
Halako lagunekin
ni nago gustura,
sentitzen dudalako
naroki onura,
zurekin dut aldendu
erraz asperdura,
zure turrusta daukat
oparo eskura,
kartzela gainditzeko
behar dudan ura.

*2013ko uztailaren 7an*

## Gure lurretan inkisidoreen menpe

Zenbat suprefet tratulari,
zenbat estatu ordezkari,
gure lurretan mehatxari,
jakobino amorratuak,
zentralista inposatuak,
inkisidore muturtuak,
euren xedea zanpaketa,
euskal senaren birrinketa,
ele txikien bazterketa,
laga gaitzatela bakean,
jardun ez dezagun txokean
askatasunaren eskean,
maite dugu demokrazia,
gaitzesten hauen malezia,
direlako bortxen hazia,
joan daitezela hemendik at,
bizi gaitezen zazpiak bat,
euskaraz libre harat-honat.

## Euskal Herriko eitea

1
Sagarra bezain mamitsua
elkartasunaren zentzua,
maitasuna bezain hezea
askatasunaren haizea,
krabelina bezain gorria
klaserik gabeko herria,
ilunkera bezain morea
berdintasunaren lorea,
esperantza bezain berdea
euskal presoaren oldea

2
Zaila den arren sinestea
zabalduko dugu atea,
garatuko da ostartea
ekiaren izpiz betea,
lortu dugulako eustea
hautsiko da gaurko katea,
euskaltzalea eta gaztea
izango du eder eitea,
hola sumatzen dut maitea
elkartuko garen urtea.

## Kideak garelako

1
Kontzientziak garbiki dit
esaldia diktatu,
berehala ohar nadin
hitz apalez aitatu,
"sakon behar zenituzke
kide denak maitatu,
eskua bero luzatuz
bizipoza sustatu".

2
Zu zinen nire mitoa
ustezko eredua,
elkar ezagutu dugu
erori zait mundua,
izaera zakarrak dit
mindu sentimendua,
aldatu egin da goibel
nire pentsamendua.

3
Kide jator jardun, arren,
gertuko lagunekin,
ez izan jarrera txarrik
erkide fidelekin,
sarritan beharko duzu
aritu beraiekin,
ondu nahi duzuelako
herria ekintzekin.

4
Begirunez har ezazu
zure ingurukoa,
askatasunaren alde
ari den kidekoa,
musu-truk dabil zintzoki
nortasun onekoa,
bere bihotz onberak du
taupada herrikoa.

5
Ideiak eta praktikak
erabili batuta,
edonon izan itzazu
gozoro uztartuta,
iparrorratzak duen lez
iparra markatuta,
eduki ezazu beti
atsegina piztuta.

6
Gorrotoaren azpian
ez dago iraultzarik,
ezingo duzu horrela
zertu utopiarik,
jenio zitala utzi
urruti ostendurik,
izan zaitez iraultzaile
xextrak indargeturik.

7
Euskal zelaia nahi nuke
pozarren elikatu,
gure alde bizitzeko
behazuna ukatu,
gu gutarrak garelako
ozen aldarrikatu,
ezinikusia baino
hobe dela barkatu.

8
Goiz-argian hitz polit bat
akabo haserrea,
aurpegietan hasi da
zoragarri barrea,
atzean geratu zaigu
eguraldi arrea,
eguzkiak gozatu du
harremanen larrea.

*2012ko martxoaren 25ean*

## Anaien (arreben, ahizpen, neben) elkartasuna

1
Anaien elkartasuna
kartzelan da osasuna,
ziegan dabil oihartzuna,
pozarren diot "Eskerrik asko"
oro dira ontasuna,
uxatzeko histasuna
dakarte alaitasuna,
behar dudan maitasuna.

2
Urteak dira metatzen
kartzelan latz kiribiltzen,
ahaztura dute zertzen,
eurak ordea nirekin daude
nekeak maitez baztertzen,
hilero haut laztantzen,
zoriona oparitzen,
xaloki ditut agurtzen.

3
Anaiak eta kideak,
elkartu gaitu oldeak,
urtetan errepideak,
ez dugulako urruntzerik nahi
batu ditugu bideak,
gure atzoko aldeak
irauli ditu kordeak
hurbilduz bihotz gordeak.

4
Gurasoen akordua
anaien sentimendua,
bete dute agindua,
babesten naute irrien truke
ontzeko bizimodua,
etzi dugu hitzordua,
jasoko dut ukendua
arin joango zait gandua.

5
Zenbat gauza esateko,
oroimena ereiteko,
gerokoa marrazteko,
gogoa beti dago irrikaz
anaiekin egoteko,
berri onak entzuteko,
fin erroei eusteko,
gurasoak goresteko.

6
Bero anaien giroan
desio bat dut eroan,
gerta dadila geroan,
gaurko arnasa nahi nuke jator
itzuli txit luzaroan,
goxo euren abaroan
nago horren esperoan
konponketaren aroan.

7
Juezari diot esana
alferrik dela afana
hausteko gure izana,
etorkizuna dirdai dakusat
hola dabil harremana,
zain dut Debako harana,
bihar kartzelen porlana
anaiontzat iragana.

8
Kartzelan dugu pindarra
euskal arimen indarra,
laister dator goizabarra,
Iñigo eta Paul zoragarri
dakarkidazue garra,
moztu duzue laharra
haz dadin aske belarra,
esperantzaren zuztarra.

*2012ko apirilaren 8an*

## Ilargia kartzelan

1
Bero dagi ohean
gaurik motzenean,
aurten sargori dator
uda porlanean,
ilargia dotore
ametsen unean,
zirrara eragin dit
taupaden gunean.

2
Iretargi zuria
izaren barnean,
bere distira daukat
dirdirka soinean,
bizipoza hazi zait
naro garunean,
askatasuna dantzut
deika gauminean.

3
Udan galanta dugu
ilargi betea,
edertzen du osoro
gaueko tartea,
berarekin urrun dut
sentitzen katea,
gogoan zaudelako
irritsu maitea.

4
Ilbehera dakusat
polit iluntzean,
mihise txit morea
duela atzean,
Artizarra du gertu
izarren pentzean,
gure arimak dira
pozten behatzean.

5
Ilargia ortzian
ostentzen denean,
begiak ixten zaizkit
hits belztasunean,
argia bilatzen dut
ziega ilunean,
zurekin oroitzetan
batzen naizenean.

6
Ilgorarekin sarri
dardara ugari,
kirioak ei dira
jartzen lar dantzari,
loa dio laburtzen
kezkatzen denari,
kartzelan maitearen
zain dagoenari.

7
Goizean esnatu naiz
ilargirik gabe,
orain eguzkia da
larruaren jabe,
etorriko zait gero
ia oharkabe,
bizi nahi nuke bihotz
zurekin lokabe.

8
Ilargi borobila
otsoen lur mina,
musa agortezina,
maitaleen grina,
emakume haurdunen
goiko emagina,
gatibuen desiren
izpi atsegina.

*2012ko uztailaren 29an*



**Oier Andueza Antxia**
1975
Durango

Atxilotze data: 2001. urtean.



C. P. Murcia II
Paraje Los Charcos
30191 Campos del Río
Murcia



**Jokin Urain Larrinaga**
1959
Mendaro

Atxilotze data: 1986. urtean.
Urte hauetan hainbat liburu argitaratu ditu: *Izaina* (AAB, 1990), *Adlotse* (Txalaparta, 1992), *Gatibu sortu nintzen* (Susa, 2000), *Errotarria* (Susa, 2006), *Ez dago etxean* (Susa, 2010), *Agurra eta Ohorea. Euskal militanteen heriotza kronika* (Ataramiñe, 2013).



C.P. La Moraleja
34210 Dueñas
Palencia

## Mundu honetan

### Araba-zozo zuria

– Hara, hara… Ikusi al duk?

Xabierrek atzamarra luzatzen duen aldera begiratu du Tinok, ezer esan gabe; zaila litzateke ikusi ote duen jakitea, luzatu zaion barre-antzagatik ez balitz. Badakite bere erantzunek hermetikoak izaten, patioko lehen orduotan batik bat.

Neguari azkena eman ezinean oraindik, udaberriaren zantzuak nabarmentzen doaz inguruan. Txolarreak dira, beharbada, urtaro berriaren aldarria egiten lehenak; kantu hotsean ezagun izaten dute aldaketa, egun eguzkitsuren bat denean bereziki. Laster hasiko dira batzuk mokoan belar edo lumaren bat dutela hara-hona. Besteren batzuk zaratan, elkarri desafioka edo, eta mokoka ere bai tarteka, haserrea nahiz lehia txorrotxioka konpontzeko larriegia dutelako agian. Joria arren ulergaitza baitzaigu hegalari xeheon armonia, eta tamala da. Zer esaten ote diete urtaro honetan txolarre batzuek besteei? Zer galdetzen ote diote elkarri?

Gozoago dirudien tortolen urruma ere entzuten da batzuetan, eta galeperren kanta pinpirina, eta eperren erlatsa; esan liteke hauek badutela euren aldarria atergabe jotzeko premia asegaitza. Hain dute errepikakorra jarduna!

Mikak ere badabiltza inguru hauetan; goizeko lehen orduetan ikus daitezke gure leihoon aurreko teilatu horren gainean geratzen, edo geratu gabe igarotzen, zeharka geuri begiratuz agian.

Horixe dute mikek euren izaera lotsagabe itxurako herabean, nahierara gera daitezkeela teilatuan geure begien aurrean, edo geratu gabe joaten ahal direla hegada farfailtsuan, isats luzea atzetik jarraika dutela, harago dagoen edo dagokeen kotaraino.

Beleak gutxiagotan azaltzen dira, kantua ala karranka ote den ez dakidana eginez, gotzainak pulpitotik ohi duen arrandiaz.

Enara sorbeltzak, eta azpizuriak batez ere, ugaldu dira egun eguzkitsuekin; eta erla-txoriak, eta argi-oilarren bat bere gandor harroarekin; usoren batzuk igarotzen dira inoiz gure ikusmen sail murriztuan zehar; eta amiamokoren bat edo beste, buztanbeltzen bat edo buztanikarak, eta hegaldi zaratatsuan igarotzen diren istinga-txoriak, kaioren bat, eta denak desagerrarazten dituen belatz edo mirua, eta gauetan ulua egiten duen hontza… Hegazti oasi eder dateke, guretzat infernu izateko aukeratu zuten leku hau.

Hainbesteren artean, araba-zozoak direla esango nuke, txolarreekin batera, hemengo txoririk ugarienak eta latosoenak, kantu-berriketa setatiena eta doinu sailka gaitzena dutenak. Hain dute jardun aspergaitza eta askotarikoa.

– Ikusi al duk? Pentsaik edozeinek edozein lekutan aurkitu ezin duen ikusgarri politari begiratzeko aukera daukaala –gehitu dio Xabierrek, Tinoren erantzun argiagoren baten bila.

Laster ezkutatu da gure patioak ematen duen ikusmen zail murriztutik ager ostenka bezala ibili ohi den araba-zozo albinoa.

Hegadunek duten erraztasun horrekin azaltzen da goizetan gure leihoen aurreko teilatura, agerpena dirudiela. Teila gainean mokoa igurzten du, zorrozten ari balitz bezala. Aurreko udan baino zuriagoa dirudi; paparretik azpialdera errauts kolore iluna hartu zuela ematen zuen orduan, eguzkiaren argitan, nora begira jarri, errauts kolore hura zilarkara bihurtzen bazitzaion ere. Dena dela, zuriagoa, albinoagoa da orain, negutik udaberrira doan sasoi honetan.

Araba-zozo mordoa biltzen da goizetan teilatu horretan, eguzkiak gailurra hartzen dionean; gauzak hozmindutako soina berotzen egoten dira, hegoak zabalduz, nagiak atereaz. Laster hasten dira alde batera eta bestera joan etorrian, janari bila edo hegan egitearen plazera sentitzeagatik.

Tinok ere soina mugitu du apur bat; Xabierrekin batera korrikalditxoa egin du, eta elkarren artean jokatu behar duten pilota partidurako eskuak berotzen hasi dira.

Patioko atea eta lau leihok libre uzten diguten eskuin paretan aritzea beste erremediorik ez daukagu. Horrez gain, zorua ez da guztiz laua, koska eta zulotxo ugariduna baizik, eta pilota hormaz bestaldera bidaltzeko ez da deskuido handia behar izaten.

## Barruko mundua

Laineza gehiegitxo darabilgula dio Josebak, hainbeste kontu eta patriofiliorik gabe jokatzen zutela eurek pilotan, mutil koskorrak zirenean, kontzejupean–eta.

– Abarkekin jokatzen genian, ortozik ez zenean espartinak ez apurtzearren –hasten da, zapatila zulatuengatik baten batek kexa egiten duenean–. Oraintxe ere… –jaurtitzen du azkenean erronka.

Lehia gogorrean aritzen dira Tino eta biak hika-mika. Astean lau-bost egunetan partiduak jokatzen ditugu elkarren artean txandakatuz, baina horrez gainera daukate bi hauek desafio eta erronka saioa. Hirurogei urtera doan arren, Josebak ez baitauka hogei urte gutxiago dituenari barkatzeko asmorik.

– Abarkekin jokatuko diat nahi duanean –bota dio–. Ni abarkekin eta hi markadun zapatila dotore horiekin!

Gaztetxoa zeneko garaiak eta Eltzikorta atariko jolasak berritu nahian dabil inola ere. Ez baita pilota kontua bakarrik. Patioko kantoi batean badaukagu hiru hankadun aulkia ipintzeko adina zoru lur eta hondar apur batekin. Perrexila eta mendafina, malbaren bat edo beste, ipomea batzuk, berakatzen bat, sagar landare erne berri bi… daude bertan elkarri lekua kendu nahian. Baratza modu horren ondoan badira beste hiru lorontzi txiki botila eta balde zaharrekin eginak, eta horietan ere indartu dira larrosondoa eta mendafina, eta krabelinak deitzen diegun lau-bost lore eta bi mahatsondo erne dira.

Goizetan, gosaldu eta, kirola egin aurretik, patio bazterreko baratza eta lorontzietan zer berri dagoen ikusi eta ura botatzen die landareei. Eguerdi aldera, kirol lanak amaitu, dutxatu eta arropak garbitu ondoren, arreta handiz begiratzen die berriro lore eta landareei. Lupa eskuan duela ikusi izan dut, doi lehertuz ernetzera doan haziren bati luzaro begira, zer lore edo landare ote den asmatu nahian. Hainbat frutaren haziak bota baititugu horra…

Gero, hormaz barruko mundu txikia oreka onean dagoela ikusita, aldizkariren bat edo egunkaria eskuetan, betaurrekoak jantzi eta patioan harantz-honantz ibilian irakurtzen du, ziegetara igo gaitezen kartzeleroa datorren arte.

Baina ez da beti horrela gertatzen. Iaz ahalegin handiz eta esperientzia eskasez balde handi batean egin genuen konpost usteak ez baitu lur emankor bihurtzeko itxurarik. Lokatza hartzitua dirudi, bai itxuran eta bai usainean. Apur bat lehortu zenean hazi batzuk bota genituen bertara, baina ez da ezer erne.

– Hemen bota ditugu espagetien tomateak, paellaren koloreak eta olioak, paperezko musuzapiak, ardikien koipeak… agian ez zeukaten ezer asko naturaletik eta konpostgaitik. Ez al zaik iruditzen?

– Etxeko txakurrak edo txerriak zuenean edo gurean egiten zuten prozesua falta, horixe gertatu zaiguk honekin –erantzuten dit Josebak etsipen airearekin. Barruan, bere txokoan eserita, irakurtzen edo eskulanen batzuk egiten aritzen den mahaitik mugitu gabe, leihoaren bestaldetik begira dakuskit Xomorro, bere jardunean keratxoa eginda bertsoren bat ehotzen seguru asko, edo goizean yogurta eta gaztanbera egiten ipini duen esnearen

jagole bestela, gure nekazal lanen atarramenduak burutaziotan nahastuta ez badauka.

Litekeena da argi-oilarraren hu-hu-hu-a entzun eta kukua ote den iruditu izana, eta pentsamendu poetikoren bat iradoki dio, beharbada, bertso jarrietarako lagungarri. Urterokoa baitu Usurbilgo Santa Isabel bertso paper lehiaketa, eta leku hauek, kartzelak, ihartu egiten dute inspirazioa, agortu, mitoak dioenaren kontrara.

– Lehen irabazi izan diat aurreneko sariren bat, baina bigarren edo hirugarren izatera atzeratu nauk azken urteotan –aitortzen zuen lehengo batean.

– Hori seinale ona duk, Xomorro; pozik egon beharko huke –bota zion Xabierrek, harria zulatuko lukeen umore ironiatsuarekin.

– Pozik?

– Gazteak onak datozela, alegia!

– Gazteak? Ni gazte sentitzen nauk ba!

– Bai, munduak badik atzekoz aurrera jartzeko seta hori; eroak sano sentitzen diren moduan, zaharrok sentitzen zarete gazte!

## Gure arteko txoriak

Goizetan, eguzkiak aurreko teilatuaren erdia hartu baino lehen hasita, joan-etorri jarioan dabiltza araba-zozoak; belar, orbel, txo-tx, artile motots garraioan ari dira horma hauetatik harago gal-soro eta olibondo sailetatik, teila hautsi eta irauli batzuek uzten dituzten zuloetatik sartuta teilapean kabia egiteko.

Horniketa lan horretan, mokoan ekarri dituen belar eta orbelen bat utzi kabia egiten ari den lekuan eta, atzera zulotik irtenda teilatuan bertan hiru-lau metrora guardian bezala dagoen biko-tearengana joan da araba-zozoa, eta maitaketan aritu dira elkar-rekin. Gero, lumak astindu eta txorrotxio batzuk egin, teilatuan gora ttipi-ttapa, ttipi-ttapa. Pinguinoenen antzeko pausu bizkor-rean gailurreraino joan, eta hegan urrutiratu dira biak.

Araba-zozo hauen kantaldi setatiek behin baino gehiagotan gogorarazten didate duela hogeitaka urte ere bazirela hemen hauen aurrekoak, araba-zozoon osabak, alegia. Eta orduko haien artean bazen bat kabiatik erorita edo lehen moduluko kideek patioan atzeman zutena lumagabe eta ahul. Kontua da araba-zozo kume hura jaso eta hazi egin zutela gure kide batzuek. He-gan ikasi ahala, jangelako mahai batetik bestera joaten zen kide baten sorbaldatik beste batenera, batek ala besteak mutxikatzen zituen fruitu lehorrak ahotik jatera.

Baina araba-zozoak bazekarren, nonbait, bere izateari zegokion jakintza antzinako eta berezkoren bat, eta, presoen artean hazia eta hezia izan arren, teilatuan edo airean hara-hona hegan ze-biltzala ikusten zituen beste araba-zozoengana jotzen hasi zen. Beretar haien kantukeran ikasi zuen, haien ibilera eta portaera. Guztiz araba-zozo izaten saiatu zen.

Leialtasun zentzua ere bazuen, ordea, edo esker onarena, edo ez zekien garbi araba-zozo ala gizaki hegalari ote zen. Kontua da euskal presoen artera itzultzen zela edozein momentutan, jangelara edo txaboloren batera.

Agian sufritzen zuen guztiz araba-zozo izan ezinagatik, libre nahiak baino areago lotzen zuelako guregana itzultzeko bulkadak, atxikimenduak. Presoengandik erabat jaregin ezinak hein batean preso bihurtzen baitzuen bera ere.

Udako bero jasangaitzetan, gehienok jangelan eseri eta telebistari begira isil isilik geundenean, leihora etorri eta txorrotxio iskanbilatsuan hasten zen, harik eta norbaitek patioko komonetako harraskan iturria irekitzen zion arte. Orduan, ur jarioan bustialdi bat hartu, lumak astindu, eta, konforme bezala, teilatura joango zen, hurrengo janari eske etortzen zen arte.

Azkenean hantxe, teilatuan alegia, nonbait propio eramandako balinarekin tiro eginda garbitu zuen gure araba-zozoa garitan zegoen txapelokerrak.

Usoa ere bazen gure moduluan garai hartan. Hegoa hautsita edo erori zen patiora. Janaria ematen hasi zitzaizkion kide batzuk eta, sendatuta berriro hegan egiteko moduan zenerako presoon artera ohitu zen. Eskutik jaten zuen eta txabolo batetik bestera ibiltzen zen leihoz leiho, batean ogi papurrak janaz eta bestean ohe gainean burko ondoan arrautza eginez.

Ez dut gogoan zer arazorengatik egin genuen plantoa afalondo hartan. Kontua da txapelokerrak sartu zirela modulura, ohi zuten itxuran kasko, porra eta abarrekin. Jangelako mahai baten

gainean edo atzeman zuten usoa ordenaren zaindariek, eta porrekin joka zirtzildu zuten bertan.

Elkartasunez edo presookin identifikatuta gure artean geratu diren txoriek ez dute suerte onik izan.

Duela hiru-lau egun patioan aurkitu zuen Nikok araba-zozo baten arrautza azala. Batzuk oraindik kabiak egiten ari diren bitartean, kumeak elikatzen hasiko dira beste batzuk.

Albinoa, araba-zozo zuria, ez da lehen bezala goizero agertzen teilatuan ohi zuen lekura. Kabiaren batean arrautzak berotzen dago beharbada, tarteka hegaldi bizkorrean azalduta txolarre eta araba-zozo guztiak galdu-gordean desagerrarazi ohi dituen aztoreak atzeman ez badu. Aztoreak, baina, araba-zozo zuriari baino beltz uniformeei edo txolarreren bati lehenago erasoko diola pentsatzen dut. Egun eguzkitsu hauetan zuria errazago mimetizatuko dela, alegia, baldin eta txapelokerren sena zitalik ez badu, behintzat, aztore edo miru horrek.

## Abarkak eta loreak

– Joseba zapuztuta zagok konpostaren ontzian ez delako ezer ernatzen. Zerbait egin behar genikek hori konpontzeko –esan dit Pakitok, patio kantoiko natur guneari begira gaudela, guztiz santua ez den betartearekin.

Baina, arrazoi du; gauza txikiekin pozten bagara presook, gauza handirik ez dugu behar izaten gogo ilunaldira jausteko ere. Duela egun gutxi arte goizero arretaz begiratzen bazion konpost baldeari, ur parrastadaren bat botatzeaz gain jaramonik ez dio egiten jada. Etsi egin duela esan daiteke, edo beste nonbaitetik duela zoriona ez bada pozaldiren baten itxaropena, edo biak batera.

Asteburuko bisitan ekarri zizkioten abarkak jantzita atera zen atzo patiora. Begirada harrituekin jarraitu genion beste zazpiok patio kantoiko baratzetxoa eta lorontziak ureztatzen zituen bitartean. Esango nuke loreei baino bere abarkei begiratzen ziela disimuluan, mutil koskorretako egunak gogora ekarriz dudarik gabe. Konpostaren ontzira ere bota zuen ur parrastada bat, baina jaramon gehiagorik egin gabe ekin zion ohiko kirol saioari.

Kirola egiteko edo egunerokoan erabiltzeko eskatuta, ikusten dituzten onenak ekarri behar izaten dizkigute etxekoek zapatilak edo janzkiak, eta halaxe dirudite Tinoren kirolerako zapatilek, erostunek ikusi dituzten onenak, pilota partiduan Josebaren abarkei zelako aldea aterako dieten ez dakigun arren.

– Baserritarrak baino, kaletarrak izaten dituk asfaltoan abarkak janzten dituztenak, eta hi ere… Eltzikortan ez huen hik abarka pare asko zulatuko –bota nion partidua jokatzeko prestaketan

korrikaldiak egiten ari zela, eta elorri arantzarekin ziztatu izan banu bezala bizkortu zuen bat-batean pausoa, baina isilik geratu zen, kontzentrazioaren onerako seguru asko.

Sei-zazpi metro izango ditu luzean frontoitzat erabiltzen dugun lekuak, eta geu igotzeko hain garai eta handi baina pilotei eusteko horren txiki eta eskas dela gehiegitan erakutsi digun eskuin paretaren bestaldera pilotarik ez jaurtitzea izaten dugu aurren arau eta kezka, tontoen lehia beroan premien lehentasunak aisa aldatzen diren arren. Txapelokerrak ibiltzen baitira gure eskuin paretaz bestaldeko estratan ikusketak eta guardi egiten, eta ez dira gutxi, tamalez, horma arte horretara joan zaizkigun pilotak, baina bakar bat ere ez da oraindik, mirarien mirariz sikiera, handik atzera hona itzuli.

Hormak; hormatzar hauengatik begiratzen diogu presook goi-goian dagoen ortziari, edo behe honetan mundu hau korritzen jarraitzen duten oinon muturrei, otoitz suharrean paseatzen duen klausura fraidearen aldean ez oso ezberdin eta ez, agian, fede eskasagoarekin. Ezker-eskuin eta aurre-atze, horma, barrote eta txarrantxa baita gure neke-bide hau.

Ziega batzuetako leihoetara igota ikusten da urrutian olibadia, eta egun gutxian loratu eta kolorez aldatzen joan den gari saila. Goizetan eta haize apur bat dabilenetan gozo etortzen da loran den gariaren usain ederra, urrutitik etortzeak, atxiki gaitz izateak, beharbada ederrago bihurtzen duena. Zer da, bada, presoon kondena, ez bada urrutitik datorrena eta urrutian dagoena itxarotea?

– Ipomea handien hauei hariak ipini behar genizkiokek, iaz bezalaxe etorri daitezen horman gora –erantzun diot Pakitori–. Azpian bazaudek oraintxe ernetzen ari diren batzuk ere…

Oraintxe arte aritu da Aimar korrika, irrati txikia belarritakoekin ipinita, entzun bide dituen kontuekin barre eginaz, irratsaio kazetariren bati ozen erantzunaz… Tino prestatu zain pilotarekin eskuak berotzen hasi berri den Josebari begira geratu gara: atzo estreinatutako abarka eta galtzerdi zuriekin markaren bat egin behar du gaurko entrenamenduan, tantorik onenak bere buruari egiten dizkion arren askotan…

Josebak hirugarren tantoa egin nahian bota duen pilotak txapa jo du bete-betean, eta arrabete bi ingurura ezkutatua zegoen gekoa atera da tximista bezain bizkor horman gora, teilatuko zulo baten bila.

Badira bi-hiru aste ilunabarretan azaltzen hasiak zirela gekoak, eta ugaldu egin dira ordutik, baina aurten patioan ikusten dugun lehena da. Begira geratu gatzaizkio denok, "hara, hara" eginez, pilota partidua etenda.

**Mundu honetan holako gauzak**

Moduluan gauden kideotakoren batek urteak egiten dituenean, erritual xume baina alaian zoriontzen dugu goizeko lehen orduan, patiora jaisten garenean. Gosaldu aurretik, urteak egiten dituenaren aurrean jarri, eta koruan kantatzen diogu aurrez ondutako bertsoa. Ondoren postala ematen diogu, abestu diogun bertsoaz gain zazpiok bakoitzak bere eskaintzatxoa idatzi eta sinatu ondoren.

Xomorro izaten da gehienetan postal eta bertsoaren egile, eta oraingoan ere bai. Urtebetetzean zoriondua, berriz, Pakito izan da:

Aizak, Pakito, primadera dek
ernaketa ororen ezten,
ikuitzen duen bihotza baitik
nabarmenki aberasten.
Urte berri bat, lora bailitzan,
tinko ari zaikianez hazten
bertso honekin hasita gaudek
eztarriak inarrosten
"zorionak" ta "urte askuan"
hiri bihotzez abesten.

Azken aurreko urtebetetzea izango du kartzelan; hogeita bederatzi urte egitera doa preso, eta datorren urtean kaleratuko da auzia gehiago okertu ezean.

Hainbeste urteren ondoren gutxi geratzen zaiola dioenari, zailena egiteko daukana dela erantzungo lioke berak, eta ez arrazoirik gabe; lehenengo hogeita bederatzi urteak izango zitzaizkion orain arteko zailenak, baina egiteko dagoena da hemen latzena.

Pakitorekin bateratsu kaleratu behar lukete, hogeita hamar urte kartzelan eginda, Mungi, Garratz, Jon Aginagalde… Ulises bera ere dezente lehenago itzuli zen Itakara… Lekutan geratu da, batere berritu gabe geratu ere, "hamar urte kartzelan…" zioen abesti hura. Urte asko daramagu patioko hormari begira, harantzago nekez luzatuz begia; lehengo lekuan batzen ote da lurra zeruarekin Kalamuako ostertzean?

Denbora da euskal idazle batek bere nobelako pertsonaiaren bitartez zioela presook ez garela enteratzen. Munduan, euren gizarteko mundu normalean zer gertatzen den, gauzak nola doazen, ez dakigula, ez garela enteratzen, esan nahiko zuen, eta arrazoi zuen beharbada. Bizitza erdia daramagu patiotik horma gain horiei begira, eta leihoetatik urrutira baizik ez dugu ikusten, ikusten badugu, lurrak eta zeruak bat egiten duten ingurua eta eguzkia nola ezkutatzen den bertan.

Irudipen bat baino irmoagoa ez da espazioarekiko gure kokapena. "Desmundua", idatzi izan dute literatura egiten-eta saiatu diren batzuek. Desmundua da, mundu deitzen zaion mundu horren desmundua, apika, baina hauxe da gure mundua, hementxe bizi gara, logika untxi narru erauzi berri alderantzia den espazio honetan.

Baina, presook enteratzen ez bagara, ez da, agian, dena presoon hutsa. Saiatu saiatzen baikara, inon diren berripaper guztiak irakurtzen eta telebistari begira, desmundu honetatik kanpoko mundu hori ulertu nahian, eta ez da erraza.

Ez gara enteratzen, beharbada, baina hemen bizi gara, desmundu honen aurka, urrutiko ostertzari ezkututik bezala leihotik begi-

ratzen diogun espazio honetan, eta gauza gutxirekin izaten dugu asko, eta gauza agian txikiekin pozten gara egun osorako, gosaldu aurretik kide laguna bere urtebetetzean zoriontzen dugunean aste baterako; edo patioko gure konpostontzi bitxi horretan, hainbeste zaputzaldiren ondoren, mirariz bezala, behingoan!, azaldu diren bi lore landareren agerkundea Josebari aldarritzen diogunean.

## Inspirazioa

Eskutitza idazteko inspirazioaren zain nengoen bitartean, txaboloko leihoaren aurreko teilatuan ilara bakoitzak zenbat teila dauzkan kontatzen ari nintzela, araba-zozoa sartu da teila hautsiaren azpian daukan kabiara.

Kabian, bere bikotekidea ez dena atzeman behar izan du araba-zozak, eta borrokaldi gogorra egin dute bien artean. Mokoka eta txilioka atera dira kabiatik, elkarri itsatsita eta buerdaka, harik eta arrotza ihesi bidaltzea lortu duen arte. Bakarrik geratu denean, kantu-txorrotxio saioa egin du bere kabiko sarreraren ondoan, arrotz asaldatzaileari erronka eta mehatxua izan dena beharbada, ez bada izan bere hutsegite propioagatik isuri duen eresi-aiene larria. Izan ere, kantu modu horren ondoren kabiara sartu baita bizkor, eta zuringoa zerion arrautza kraskatua mokoan duela atera baita berehala, hegan desagertzeko teilatuaz haraindira. Laster itzuli da hala ere, eta mokoan beste arrautza urdin bat duela irten kabiatik eta teilatuaz harantza joan da berriro.

Araba-zozo biak borrokan, zalaparta eta txilio jardun direnean apurtu dituzte, agian, bi arrautzak; edo berariaz kabia zapuztera sartu da arrotza, besteren ona ezin jasanik, eta puskatuak zeuzkan kabiaren jabea iritsi denerako… Baina litekeena da altxor bilatzaile asmo txarrik gabea izatea araba-zozo arrotza, eta zaindaririk gabe arrautza urdin dotore eta guzti aurkitu duen kabia ederra berak zaindu nahi zuen beharbada. Ez genioke intentzio gaiztorik egotzi behar motibo argiagorik ezean, izan batzuetan izaten dituzten arren txoriek ere asmo gaiztoak.

Xomorrok kontatzen du bere ziegako leihoaren ondoan nola egin zuten enarek kabia, lehen moduluan, duela urteren batzuk.

Sortaldera begira daude lehen moduluan gu egon ohi garen galeriako txaboloen leihoak, eta han egiten dituzte enarek, azpi zuridun beltx horiek, lurrezko kabiak, erlaitzpean. Hemen, ostera, hirugarren moduluko galeria honetako erlaitzpean, bakar bat ere ez eskuarki. Sortaldera begira baitago galeria honetan gure erlaitzpea, eta badirudi ez dela kokapen egokia. Eguratsean hezetasun aldaketa handia dagoenean nola edo hala desegin egiten direlako sortaldera begira dauden lurrezko kabia horiek, sortaldera begira daudenak ez bezala. Egun eguzkitsu beroaren iluntzean ekaitza etortzen bada haize epel sargoria eta euri zaparradarekin, plisti-plasta erori daitezke erlaitzpean sortaldera begira dauden buztinezko enara kabiak, euren arrautzak ere behean lehertuz.

– Kontua duk neure leihoaren ondoan egin zutela enarek kabia –kontatzen du Xomorrok–, eta ispiluarekin egoten ninduan tarteka begira, hasi zirenetik amaitu zuten arte. Badakik, ordea, txolarreak ere ugari dabiltzala hemen; ugari eta lotsagabe. Ba, nik baino are jarraipen zorrotzagoa egin zietean txolarre haiek enaren kabiagintzari, eta, amaitu zutenean, eurentzako aproposa zela iruditu zitzaiean, txilio eta mokoka eraso eta enarak uxatu ondoren, beraientzat hartu zitean txolarreek lurrezko kabia hura.

Txori gogorrak eta ausartak dira txolarreak, araba-zozoen aurrean ere berehala kokiltzen ez direnak. Teilatuko araba-zozoen kabietatik lastoz, artilea eta halakoak lapurtu eta eramaten di-

tuzte batzutan. Baina aztore edo belatzen bat ortzian itzulika ikusita araba-zozoren batek aldarri egiten duenean, txolarreak izaten dira inon aztarrenik laga gabe desagertzen bizkorrenak.

Txolarre izutua legez desagertua den nire inspirazioaren zain jarraitu dut, leiho aurreko teilatuaren gailurrera begira oraingoan. Ortzi urdina baizik ez da ageri hortik harantz. Eraikuntza eta teilatu horren bestaldean badira, hala ere, gari sail eta olibadiak… hantxe dabilke, oinetan gariaren igurtzi leuna sentituz agian, edo olibondoen gerizpe gozoan, nire inspirazioa ez dakit baina gogoa, musa deslai bihurtuta, etxe minez burumakur…

Inguru horretatik datoz behin eta berriz araba-zozoak, kumeentzako janari garraioan nekagaitz. Batzuei har berdexkak ikusten dizkiet mokoan; bakarren batek belarren bat dakar, agian kabia konpontzeko… Eta hara non azaldu den araba-zozo zuria, mokoan zerbait dakarrela bera ere, galsoroen aldetik gure galeria honen teilatu aldera. Hor dabil, hemen dabil…

## Partidua

Udaberriak udari eman dio denbora, beste behin. Berriro bero hau, eta euli amorragarri hauek… Gurpilaren itzuli bakoitzean behin eta berriz datorren madarikazioa dirudi.

Aurreko asteotan lumatu ahala joan dira, hegaldi baldarretan, teilapeetako kabietan zeuden araba-zozo kumeak. Txolarre kumeak agertu dira han eta hemen hegaldi laburrak eginez… Hegan hasi aurretik ote dakite txoriek airez ibiltzeko jaioak direla? Ez ote zaie zoragarria iruditzen?

Salamankesak erruz ugaldu dira ilunabarretan; handiak eta txikiak ibiltzen dira gure leihoen aurreko horman hara-hona, eta leihora etortzen zait bat, leihotik begira kiwia zuritzean erlaitzean isurtzen diren tanta lehortu gazi-goxoak miazkatzen ikasi eta gustatu zaionetik. Eta goizetan patioko leihoan traste eta kaxa artean ezkutatuta egoten dira batzuk; patio kantoiko loreen artean besteren bat, Joseba landareak ureztatzen hastean edo Pakito liburuen orri artean lehortzeko ipomeak biltzen dabilenean tximista bezain bizkor joaten dena horman gora ihesi.

Konpostaren ontzian oparo berdetu dira bi-hiru krabelin, ipomea batzuk eta tomate landarea, elkarri leku egin ezinean. Miresmenez begiratzen die antzuolarrak goizero, ureztatzen dituen bitartean igurtziz, inoiz bertsoren bat kantatuz ahapeka, kuttunki.

Gaur, hala ere, kanta lotsarik gabe dabil goizeko lehen zereginotan. Abarka eta galtzerdi zuriak jantzita atera da, ez dakit nekazal lanak ala jokatu behar duen partidua gogoan. Ez daukala ikusleen berbaroarekin kikildu beharrik, geu besterik ez dagoela

hemen, esan diot soin luzaketak eta keinu deszifra ezin batzuk egiten dituen bitartean.

Zehar begirada zorrotza egin dio Tinori, beroketaren batzuk eginda patiora azaldu denean. Esango nuke haren zapatilei begiratu diela bereziki, arao gaiztoren bat eragin nahian beharbada.

Xabier ikusten dut Tino animatzen eta aholkuak ematen. Beste laurak, Pakito, Aimar, Niko eta Xomorro, partiduaren ondoren egingo dugun hamaiketakoa mahaian atontzen ari dira.

Zuriz jantzita jokatutakoa dela dio Josebak eta, galtzekotan, partidua baino nahiago luke ohea galdu. Tinok abantaila du gaztetasunean, eta patio honetan onena bera dela esango nuke, besteak baino gutxiagotan jokatzen duen arren. Gogotsu hasi dira, biak bietara, eskuak berotzen, daukagun pilota bakarrarekin; ez baitugu izan aukerarik besterik egiteko. Hariak eta narruak, denak arriskutsutzat dauzkate nonbait hemen, eta ez dute uzten etxetik halakorik paketean sartzen. Pilotan jokatu ezin dugunik ez dute esaten, ezta pilotarik egin ezin dugunik ere; baina ezin dela etxetik paketean halakorik sartu. Eskatzeko kalera, kartzelako errekaderoaren bitartez. Eta eskatzen dugu, erruz eskatu ere, esku pilotak egiteko narrua eta haria. Erantzunik ez, ordea, ez baiezkorik eta ez ezezkorik. Ahuntzarentzat espartinak eskatuko bagenitu bezala. Horixe du kartzelaren logikak, eta, ulertzen saiatzen bazara, deskuidatuta zaude.

Eta, deskuidatuta gauden bitartean, partidua jokatzen hasi dira Tino eta Joseba. Pilota motel samarra den arren, zital ateratzen du Tinok, ezkerretik eskuin hormaren barrenera, eta ia batere boterik egin gabe joan da pilota, Josebaren orroa gorabehera; berriz atera, eta berriro tanto Tinok…

Hemen ez du inork atsedenerako denborarik eskatzen; partidu bizkorrak jokatzen ditugu, eta amaitu arte ez da geraldirik egiten. Amaitu ala lehertu, alegia, eta, itzalgunerik gabe, eguzki galgapean ari dira.

Pilotari abiadura ematen saiatzen da Joseba, bai atzera eta bai zabalera, Tino hara-hona mugiarazi eta hutsartea bilatu nahian. Baina Tinok ere egin nahi ditu bere tantoak, eta pilota motel horrekin ezin hobeto ateratzen zaizkion dejadak egiten ditu eskuin txokora, Josebari orroa itzelak jaulkiaraziz.

Epailerik gabe izaten dira hemengo partiduak; tanto baten gorabeheran eztabaidatzeko astirik gabe jokatzen dugula esan liteke. "Joanak joan; honekin konforme ez bahaiz, jokatu bizkor beste bat" litzateke lema, bai tantoei eta bai partiduei dagokienean.

Halaxe doa gaurkoa ere, baina ez ahaleginik gabe. Tantoan ia txandaka eginez iritsi dira hogeita bat eta hogeira, eta Josebak du sakea. Arnasa baretzeko astirik eman gabe atera du Eltzikortak, partidua jo eta amaitu eta hamaiketakoa egiteko gogoz. Baina jaso egin du Tinok, frontisaren eskuin ertzean dagoen koska jo eta zabal-zabalera bidaliz pilota. Josebak harrapatu egin du ordea, eta egundoko ezkerkada eman dio, Tinoren gainetik pasa eta atzera bidali nahian. Baina frontisean uste baino gorago jo eta, alanbre txarrantxa artetik, hormaren gainetik, agur esanez bezala joan da pilota patiotik kanpora. Orroa itzela egin du Josebak, alfer alferrik. Ez dago beste pilotarik, eta kanpora joan den hori ez digu inork itzuliko. Akabo! Hogeita bana.

Goazen hamaiketakoa egitera.



**Joxe Karlos Apeztegia Jaka**
1964
Iruñea

Atxilotze data: 1992. urtean.
2013ko maitzaren 22tik ASKE!

## 2004an gertatua

Andaluzia aldeko espetxe batean gertatu zen, 2004ko azaroan. Kartzelariek euskal preso baten ziegan miaketa egin zuten, lekukorik gabeko miaketa, eta ohi bezala, ziega guztiz nahaspilatu zuten. Hau ohiko kontua zen espetxe horretan, kartzelariek euskal presoekiko gorrotoa ez baitzuten inolaz ere ezkutatzen. Beraz, euskal presoa nolabait "ohitua" zegoela esan beharra dago, eta ez zen bereziki kezkatu.

Baina bi aste geroago, euskal preso horrek bere izena irratiko albistegian entzun zuen, kartzelarien sindikatu batek egindako salaketaren arabera, bere ziegan egindako miaketa batean beste espetxe bateko kartzelariei buruzko xehetasunak aurkitu omen zizkiotelako. Kartzelarien sindikatu horrek salatutakoren arabera, hau oso gertaera larria zen.

Jakina, miaketa egiteko unean euskal presoari ez zioten honetaz deus ere jakinarazi, kontu honen berri irratiaren bidez izango zuelako ustean-edo.

Une hartan, 2004ko azaroan, hainbat espetxetan kartzelariak protestaldiak burutzen ari ziren hilero diru gehiago irabazi nahi zutelako, horixe baita honelako sindikatuen zeregin ia bakarra. Kartzelariek hilero ahalik eta diru gehien irabazi nahi dute, askotan ahalik eta lan gutxien eginik, eta helburu hori lortzeko edozerk balio duela uste dute, gerlan eta amodio kontuetan bezalaxe. Edo horixe uste zuten eta horren arabera jokatu zuten.

Beraz, salaketa larri hori eginik, protestaldi horretan beren jarrera indartu nahi zuten eta betiko leloak berriz ere erabiltzeari ekin zioten, esan nahi baita, gure lanbidea oso arriskutsua da, gure

segurtasuna ez dago ziurtaturik, gure lan-baldintzak txarrak dira eta egunero pairatzen dugun egoera jasangaitza da. Eta "arazo" horiek konpontzeko zein zen kartzelariek aldarrikatzen zuten konponbidea? Diru gehiago irabaztea, besterik ez omen zutelako behar, helburu hori behin lorturik, "arazo eta oztopo" guztiak berehalaxe desagertuko bailirateke, jakina.

Egia esan, euskal presoaren ziegan ez zuten ezertxo ere aurkitu, eta ez zitzaion inoiz ere ezer leporatu. Urteek aurrera egin zuten, baina euskal presoa ez zuten inoiz zigortu. Euskal presoaren aurka egindako salaketa oso larria izan zen, baina salaketa gezurrezkoa izan zen. Kartzelariek garai hartan lan gatazka bizi zuten espetxe zuzendaritzarekin, eta nahi zutena lortzeko euskal presoak zitalkeriaz erabiltzeko ez zuten inolako eragozpenik izan, euskal preso baten aurka ondorio larriak ekar zitzakeen azpikeria itzela burutzea ez baitzuten desegokitzat jotzen, ez horixe. Espainia aldean gezurra oso erraz bihurtzen da egia, zoritxarrez.

Euskal presoari ez zitzaion deus ere gertatu, espetxe horretako arduradunek sindikatuen jardueraren berri zehatza bazutelako, eta hedabideetan eginiko salaketa larriaren oinarrian gezurra besterik ez zegoela ongi asko bazekitelako, halaz kartzelarien sindikatuak ez zuen bere helburua lortu.

Urteak igaro ziren eta espetxe hori berriz ere albiste bihurtu zen hedabideetan. Espetxeko zuzendaria kargugabetu egin zuten, ustelkeria leporatzen ziotelarik. Espetxe horretan 400.000 euro desagertuak omen ziren eta ikerketa ofiziala abian zen, espetxe horretako diru kontuak zehatz-mehatz aztertzeko, ustelkeria zantzu nabariak egon bazeudelako.

Eta albiste hau zabaldu bezain laster, kartzelarien sindikatuek hauxe adierazi zuten, ez zela gaizki pentsatu behar, beraiek ez zeudela ustelkerian murgildurik, zintzo eta ondratu askoak zirelako, eta gizarteari espetxe horri buruzko okerreko ikuspegirik ez zitzaiola eskaini behar, beraiek ez baitziren ustelak.

Hortaz, sindikatuek esanikoa sinetsi beharko da, Espainia aldean inortxok ere ez baitu gezurrik esaten, joera hori aspaldian baztertu baitzen. Baina, zoritxarrez, beti izanen da gaizki pentsatuko duen jendea, hori ezin baita ekidin, eta jende maltzur horrek buruan hauxe izanen du ziurrenik, "*excusatio non petita, acusatio manifesta*", edo antzeko zerbait.

Maltzurkeriak ez du mugarik, baina esaera latinez idatzia dago eta, zorionez, ez da ulertzen.

## Eguzkiaren argia

Aurkezle espainiar hori emakumea zen, eta horixe zuen lanbidea, kazetaritzan aritzea hain zuzen ere. Aurkezle ospetsua zen eta bere jarduera telebistan eta irratian garatzen zuen bereziki, baina azkenaldian Espainiako telebista pribatu batean goizeko saioa gidatzen zuen beti.

Euskal presoak aurkezle hori telebistan edo egunkari baten argazkian ikusten zuen bakoitzean, bere buruak denboran atzera egiten zuen aurkezle horrek behin esaniko hitzak gogora etortzen zitzaizkion beti.

Aspaldian gertatu zen, 1996ko abenduan. Garai hartan aurkezle horrek gaueko albiste saio bat gidatzen zuen Espainiako irrati batean, eta irratsaio horretan egunero eztabaida politikoa burutzen zen, aurkezle horren gidaritzapean. Eztabaida politiko guztietan gertatzen zen bezalaxe, irratsaio horretan ere Euskal Herriari buruzko aferak aipatzen zituzten, ia ezinbesteko baldintza baitzen hori Espainiako irratigintzan garai hartan.

Egun horretan, euskal presoak aipagai izan zituzten, eta eztabaida politiko horretan ziharduten sasi kazetariak eta adituak iritzia azaltzen hasi ziren. Bataz beste, euskal presoekiko iritzi orokorra hauxe zen, espetxean ederki asko bizi zirela eta gehiegizko eskubideak eta onurak zituztela. Gainera, eskubideei buruzko aipamena nolabait indartzeko sasi kazetari batek euskal presoek espetxetik telefonoz deitzeko eta buro-faxak bidaltzeko eskubidea bazutela adierazi zuen, eta hau onartezina-edo iruditzen zitzaion.

Jakina, euskal presoek ez ezik, preso guzti guztiek telefonoz deitzeko eta buro-faxak bidaltzeko eskubidea bazutela esatea ahaztu omen zitzaion, legez horrelaxe arautua baitzegoen. Ahaztu, edo agian ez zuen jakingo, edo bost axola zitzaion, edo nahita gezurra esan zuen. Batek daki.

Egia esan, espetxetik egin daitezkeen deien inguruko eskubidea ez da euskal presoendako bereziki sortutako eremua, preso guztiendako baizik, baina Espainia aldean gezurra oso erraz bilakatzen da egia, politikagintzan aritzeko ezinbesteko tresna baita.

Izan ere, eztabaida gero eta gehiago berotzen hasi zen eta euskal presoek giltzapean izugarrizko bizimodu ona zutela esatean denak bat etorri ziren. Beraz, euskal presoei eskubideak murriztu behar zitzaizkiela, haiekin gogorrago jokatu beharra zegoela eta are gehiago zigortu behar zituztela ondorioztatu zuten aho batez.

Eta, halako batean, denek lortutako adostasuna nolabait adierazteko asmoz, sasi kazetari horietako batek euskal presoak leotzik ilunenetan giltzaperatu behar zituztela esan zuen, jendilaje horrek besterik ez zuelako merezi.

Hortaz, eztabaida horretan sorturiko giro bikainarekin bat egin nahirik-edo, une horretan bertan saioaren gidari aritutako aurkezleari barru-barrutik hauxe jalgi zitzaion, "horixe da, eguzkiaren argia ez dezatela berriz ere ikusi".

Dirudienez, eguzkiaren argia ikustea bera ere gehiegizko eskubidea iruditzen zitzaion aurkezle lanetan ziharduen

emakume horri. Baina aurkezle horrek ziurrenik bere burua demokraziaren aldekotzat jotzen zuen, hori ezin baita inolaz ere auzitan jarri, bere eguneroko jardueran gorroto eta mendeku goserik gabe jokatzen zuelako. Omen.

Jakina, jende guztiak ez omen du eguzkiaren argia ikustea merezi, eta batez ere euskal herriaren aldeko borrokan engaiatu ziren euskal borrokalariek ez dute merezi. Espainia aldean hau jende guztiak badaki, edo izena Donostiako hondartza batek bezalaxe duen sasi kazetari horrek horixe uste du, behintzat.

Bai, emakume hori ikusten duen bakoitzean euskal presoari 1996ko abenduan izaniko irratsaio batean aurkezle horrek esaniko hitzak gogora etortzen zaizkio, eta ezin du deus ere egin hori ekiditeko, emakume horren aurpegia eta aspaldian entzundako hitzak ezinbestean lotzen baititu.

## Hô Chi Minh

Euskal presoaren ziegan kartzelariek miaketa egin zuten, miaketa zorrotza. Paper bila ari ziren, ezkutuko mezu garrantzitsuren bat aurkitu nahirik. Honelako miaketak ia ohiko kontua suertatzen zitzaizkion euskal presoari, eta nolabait "ohitua" zegoela esan liteke.

Miaketak zirela eta, normalean ez zuten ezer berezirik aurkitzen, baina hala eta guztiz ere, kartzelariak behin eta berriz tematzen ziren, noizbait zerbait esanguratsua aurkituko zutelakoan-edo.

Eta miaketa horretan ari zirela, halako batean kartzelarien buru egiten zuenak zerbait aurkitu zuen, eskuan paper bat hartu eta arretaz aztertzen hasi baitzen, eta zertxobait geroago, miaketan aurkitutakoa euskal presoari erakusten zion bitartean, hauxe galdetu zuen:

– "Zer da hau?".

Eta euskal presoak erantzun zion:

– "Hori Hô Chi Minh-en argazkia da".

Kartzelariak berriz ere galdetu zuen:

– "Eta nor da hori?".

Eta euskal presoak azaldu:

– "Vietnam-en sorturiko iraultzailea izan zen, Vietnam-go alderdi komunista sortu zuen eta Vietnam zapalkuntzatik askatzeko frantziar eta estatubatuarren aurkako borroka gidatu zuen".

Kartzelariak euskal presoari begiratu zion, baina bere begirada iluna zen, entzundako azalpena sinetsiko ez balu bezalaxe, ondorengoa esateko:

– "Ez dakit argazki hau gorde dezakezun. Baliteke legez kanpokoa izatea. Guk argazki hau eraman egingo dugu eta zuk esandakoa egiaztatuko dugu".

Beraz, egun horretan euskal presoaren ziegan egindako miaketan gauza bakarra eraman zuten, Hô Chi Minh-en argazkia hain zuzen.

Astebete igaro ondoren, euskal presoari argazkia itzuli zioten, eta itzultzearekin batera hauxe esan zioten:

– "Zuk esandakoa egiaztatu dugu eta egiazkoa dela jakin dugu. Hortaz, argazkia gorde egin dezakezu, ez baitago arazorik".

Eta arazorik ez zegoela egiaztatu ondoren, euskal presoak Hô Chi Minh-en argazkia ziegan gorde zuen.

Agian hurrengo miaketan berriz ere kenduko diote, legez kanpokoa delakoan-edo, batek daki.

## Mustafa

Aspaldian, frantziar boteredunek, Aljeria Frantzia zela aldarrikatzen zuten. Hortaz, aljeriarrak Frantziako gainerako biztanleak bezain frantziarrak omen ziren eta eskubide berberak omen zituzten. Aljeriar askok frantsesez ez zekiten, beraien eguneroko mintzaira arabiera edo amazighera baitziren, eta aljeriarren kulturak ere ez zuen Frantziakoaren antzik, baina Parisko boteredun indartsuek Aljeria Frantzia zela erabakia zuten.

Hau ez zen egia. Frantziar boteredunek Aljeriako petrolioa eta gasa besterik ez zuten nahi, eta lapurreta horretan luzaroan jardun zuten, aljeriar guztiei zegozkien naturaren baliabideak ustiatzen zituztelarik, baina aljeriarrek etekinak usaindu ere ez zituzten egiten.

Frantziar zapaltzaileak 130 urtez Aljerian egonak ziren, eta aljeriarrek denbora nahikotxoa zela eta Aljeria Frantziaren uztarpetik askatu behar zela erabaki zuten. 1954an herrialdea askatzeko gerla hasi zen, 1954ean hasi eta 1962an bukatu. Zortzi urteko gerla luze eta gogorra izan zen, eta horren ondorioz milioi t'erdi aljeriar inguru hil ziren, baina aljeriar abertzaleek gerla irabazi zuten eta zapaltzaile atzerritarrak Aljeriatik kanporatu zituzten. Beraz, frantziarrak frantziara itzuli ziren.

Gerla garaian aljeriar guztiek sufrimendua pairatu zuten, baina badira bereziki gogoan izan beharreko izen batzuk, eta Mustafa Benboulaid horietakoa da.

Mustafa Benboulaid Aljeriako ekialdean jaioa zen, bertako nekazal burgesiaren sendi baten baitan. Pentsalari ospetsu bezain gizon jakintsua zen. Besteak beste, Mustafak Aljeria Frantziaren uztarpetik askatzeko borroka gidatu zuen, gidari garrantzitsua bihurtzeraino. Baina, zoritxarrez, frantziarrek egun batean atxilotu zuten, atxilotzeaz bat txantaia egin nahi izan zioten. Hala ere, Mustafak ez zuen txantaiarik onartzen.

Frantziar zapaltzaileek Mustafari eginiko proposamenaren muina hauxe zen, gutxi gora behera: "Kazetarien aurrean, jende guztiak garbi ulertzeko moduan, Aljeria Frantzia dela onartzen duzula, eta independentzia lortzeko borrokari uko egiten diozula adierazi behar duzu. Hori egiten baduzu, biziko zara, bestela, hilko zara zein da zure erantzuna?".

Mustafa Benboulaid-ek emaniko erantzuna hauxe izan zen: "*Avec moi ou sans moi, le drapeau algérien monterá*" (nirekin edo ni gabe, Aljeriako bandera goratuko da).

Jakina, "*Liberté, egalité et fraternité*" lelo ezaguna aldarrikatzen zuten horiek ez zioten bere herrialde zapalduarekiko atxikimendua barkatu, eta Mustafa Benboulaid erahil zuten.

Geroztik, Aljeriar abertzale honen izenak aljeriar guztien gogoan bizirik dirau, heriotzaren aurrean makurtu ez zen gizon hori denek miresten dutelako.

Lehen esan bezala, Mustafa Benboulaid-ek ez zuen txantaiarik onartzen, eta Aljeriako bandera goratu eta haizean zabaldu zen.

## Oroitzapena (Iruñea, 1972)

1972an euskara eta euskal kultura guztiz bazterturik eta zapaldurik zeuden Nafarroako hiriburuan, legez kanpokoak baitziren. Iruñean bizi ziren euskaldunek euskalduntasuna ezkutuan bizi behar zuten, etxean. Etxetik kanpo ezin ziren euskaraz lasai mintzatu, karrikan euskaraz aritzen ziren euskaldunek isekak, irainak eta erdeinua pairatzen zituztelako. Franco bizirik zegoen eta euskal kulturaren aurkako giroa eta gorrotoa indartsuak ziren. Beraz, euskal izaera ezkutuan bizi beharra zegoen. Euskaldunak ez ziren besteak bezalako herritarrak, bigarren mailakoak baizik, eta euskarak eta euskal kulturak ez zuten inolako babesik, euskara bere herrian hizkuntza arrotza baitzen.

1972. urteaz geroztik urte asko igaro dira jadanik, baina gaur ere euskal presoak urte hartan eskolan gertatu zitzaiona gogoratzen du. Zortzi urte zituelarik, La Salletarren ikastetxean ikasten zuen , Iruñean. Ikasgelan 35 ikasle zeuden, denak edo gehienak nafarrak. Egun batean, ikasle guztiak ikasgelan zeudela, fraide gipuzkoar bat sartu zen, Basilio izena zuena, eta ikasle guztien aurrean "egun on" esan zuen. Hori egin eta berehalaxe hauxe galdetu zuen erdaraz:

– "¿Alguno sabe lo que he dicho?".

Euskal presoak ikasle guztiak mutu gelditu zirela gogoratzen du, inortxok ere ez baitzuen fraideak euskaraz eginiko agurra ulertu, baina berak besoa jaso eta honelaxe erantzun zuen:

– "Ha dicho buenos días en vasco".

Erantzuna entzun eta gero, fraideak hauxe galdetu zion:

– “¿Y tú cómo sabes eso?”.

Eta euskal presoak honelaxe erantzun zuen:

– “Porque mi madre habla vasco”.

Orduan fraideak hauxe galdetu zuen:

– “¿Y tú hablas vasco?”.

Euskal presoak erantzun zion:

– “No, entiendo un poco”.

Eta hau entzunik, fraideak honela gomendatu zion:

– “Pues dile a tu madre que te enseñe a hablar en vasco”

Hau gertatu zenetik urte asko igaro dira, baina gertaera guztiz berezia iruditu zitzaiola gogoratzen du euskal presoak oraindik ere. Ikaskide guztien artean inortxok ere ez zekien “egun on” zer zen. Ikaskideak ere harritu egin ziren, haietako batek euskaraz zertxobait ulertzen zuenik ez zekitelako. Garai hartan, Iruñean, euskara eta euskaldunak ia ezkutuan bizi ziren. Euskal presoak une hartan zortzi urte zituela gogoratzen du, baina bere arbasoen hizkuntza eta kulturarekiko nolabaiteko kezka piztu zitzaiola esan liteke.

Etxean senideek erdara ez zen beste hizkuntza bat egiten zutela bazekien zortzi urteko mutiko hark, eta batzuetan beraiek ezberdinak zirela sentitzen zuen, besteak bezalakoak ez zirela, beste kultura bat bazutelako. Iruñetik amaren herrira joaten zirenean, euskal presoak amak amiñarekin euskaraz egiten zuela ikusten zuen, eta honelakoetan ezberdinak izatearen sentimendua areagotu egiten zitzaion.

Eskolako gertaera izan eta gero, zortzi urteko ikaslea euskara eta euskal kultura zapaldurik zeudela ohartu zen, eta berak berezkotzat jotzen zuen kultura horren alde zerbait egin beharra zegoela ulertu zuen, zortzi urteko mutiko batek uler dezakeen moduan, jakina.

Eta urteetan aurrera egin ahala, mutiko horrek bere burua euskaldundu zuen eta Nafarroan euskara eta euskal kulturaren alde lan egitea beharrezkoa zela are gehiago ulertu zuen. Beraz, helburu hori lortzeko borroka politikoaren beharra bazela ohartu zen. Nafarroan euskararekin batera abertzaletasuna eta kontzientzia politikoa ere zabalduko zirelako eta horren ondorioz, gaztea zela, borroka politikoari lotu zitzaion. Eginbehar hori beharrezkoa zela uste zuen orduan, eta beharrezkoa dela uste du gaur egun.

Hain zuzen, Nafarroako boteredunek ere euskarak Nafarroan sortzen duen "arriskua" ederki ulertu dute beti, zoritxarrez, eta euskara eta euskal kulturaren aurka behin eta berriz egitea ezinbesteko helburua zela ongi ondorioztatu zuten.

Hortaz, 1972an Nafarroan boterean zeuden horiek gaur egun ere botereari loturik darraite, baina beste mozorro baten pean, eta zenbait unetan egoera ez dela horrenbeste aldatu pentsatu liteke, euskarak egunerokoan gainditu behar dituen oztopoak ez baitira makalak. Aurrerapenak izan direnik ere ezin ukatu, jakina, baina boteredunen gorrotoa eta ezinikusia hortxe daude oraindik, eta lanean gogotsu jarraitu beharra dago. Euskara eta euskal kulturaren aldeko jardunean ezin baita etenik egin. Horrek tripako min ederra eragiten baitie 1512an Nafarroari burujabetasuna indarkeriaren bidez ebatsi zioten atzerritarrei, eta baita laguntzaile gisa jardun zuen bertako jende ustelari ere.



**Ibai Aiensa Laborda**
1978
Berriozar

Atxilotze data: 2002. urtean.



C. P. Monterroxo
Ctra. Vegado - Pontevedra s/n
27.568 Monterroxo
Lugo



**Kepa Mirena Solana Arrondo**

Atxilotze data:1991ean atxilotua.



C. P. Bonxe
Bonxe - Outeiro de Rey
27.153 Bonxe
Lugo

## Soño ou realidade

Malia ter soamente cincuenta anos e estar nunha boa aparencia física, Xoán volve espertar sen forzas, algo que cada día resulta máis frecuente. Botando a vista atrás, dende mozo foi unha persoa moi dinámica, "O perexil de todas as salsas" que diría a súa avoa.

Mais dende hai dous anos a súa enerxía semella ter desaparecido por completo e incluso érguese apático cada novo amencer, como se a vida xa non tivese o máis mínimo sentido.

Todo comezou cando, despois de trinta anos traballando como soldador en Navantia, foi botando e dende entón non volveu atopar traballo.

De todas maneiras, volve axeitartse e, mentres preparaba o seu almorzo, disponse a escoitar a radio, coa intención de saber o que aconteceu polo mundo durante estas últimas horas.

Á par que enche de sopas a súa cunca grande de café con leite, a locutora relata, de xeito moi profesional, a siguiente noticia:

"No primeiro trimestre deste curso o Banco Bilbao Vizcaya Argentaria rexistrou un beneficio de 1734 millóns de euros, o que supón un incremento do 72,6% respecto ao mesmo período do exercicio anterior. O ano pasado...".

A locutora continúa co monótono relato, mentres Xoán percibe que a súa capacidade de aguante chegou ao límite, aínda que nada teña comentando coa súa muller María nin co seu fillo Uxío. Bastante preocupación teñen eses dous seres queridos tamén, pois, ambos, encóntranse en paro e subsisten cos 800 euros do subsidio que cobra el.

Remata o seu almorzo e, camiñando pausadamente, baixa á adega da súa casa, disposto a poñer o seu coche en marcha. Antes de meter a chave no contacto, asegúrase de que súa escopeta de caza, á cal lle recortou os canóns, atópase debaixo do asento.

Respirando nerviosamente ao notar o contacto frío da arma, tenta sosegarse, autoconvencéndose de que non hai outra saída e que todo sairá ben. Intentando non acelerar demasiado, pois non convén que o pare a policía no seu traxecto ao Banco, repasa como vai actuar, marcando coma prioridade absoluta o feito de que ninguén resulte ferido.

Unha vez diante do Banco, pon unha capucha e accede ao interior, momento no que un silencio sepulcral invade a todos os presentes. A par que comeza a dar instrucións, para que todo saia segundo o planeado, non se decata de que un empregado acciona unha alarma silenciosa.

Cos nervios a flor de pel, enche o macuto cos cartos necesarios para que, el e a súa familia, poidan subsistir ata ese momento tan anhelado no que volverá atopar traballo.

Ensimesmado nos seus pensamentos, non escoita unha serie de ruídos e inmediatamente un megáfono cospe a seguinte frase lapidaria: "Fala a policía. Depoña a súa actitude e non pasará absolutamente nada".

Case sen poder respirar, Xoán esperta tremendo e entre suores. Unha vez recuperado o seu ritmo cardíaco, chega á conclusión de que todo fo un pesadelo. Sorrí placidamente e de seguido atrona nas súas orellas o inconfundible berro:

RECONTO!

***Tatexo.***

Eu non son deste anaco do
mundo, mais atopeime cunha
lingua mara billosa. Malia
que algúns digan que é
cousa de aldeáns eu
penso que ten unha melodía engaiolante e é un
verdadeiro tesouro a gardar. *Saudade, polbo,*
*mestura , carballo, fala, ledicia, crebanoces, é*
*ruxerruxe,esquecer, ababol, pescada, lóstrego,*
*vertixe, morea, dúbida, ollamol, fasquía, gorxa,*
*miñaxoia, adega, baleiro, ángora, xenreira*
*liorta, andrómena, vermello, azo, laxe, burato*
*endexamais, esmorga, choio, agarimo*
*aiga,sartego, mol, mosteiro*
*berce, furna, carrizo*
*présa, beizo*
*hai, pereira*
*laverca, rúa*
*axada, beira*
*cóbados, súa*
*lume, cunca*
*segundo, ti*
*corte, seica*
*onte, carallo*
*miolo, hoxe*
*acolá, bico*
*tixola, lonxe*
*silveira, ulo*
*queixo, ravo*
*cativo, aínda*
*serán, espido*
*carón, malia*
*aperta, auga*
*fíolla, carolo*
*auteiro, póla*
*voda, decote*
*pega, mestura, agasallo, estrume*
*castiñeiro, cuspidiña, cadaleito*
*paspallás, pexegueiro, testemuña, moa*
*ruxerruxe, pegureiro, ceibe, derradeira.*
Palabras que espertan no interior de cada
quen sensacións que unicamente unha lingua
é capaz de xerar. Legado duns antepasados
que viviron e gardaron esta lingua
coma parte do seu ser. Idiosincrasia
dun pobo e ferramenta de
comunicación. **CHAVE** do pasado,
presente e
futuro.



**Mikel Azurmendi Peñagarikano**
1966
Beasain

Atxilotze data: 1998ko martxoan.



C. P. Valencia III
Apdo. 1.002
46.220 Picassent
Valencia

## Tximeletari tximeletez

Tximeleta izatera jolastu ziren neskatxa haiek, ez dakit zein urteetako inauterietan, hegalei eragiten zieten noizbait aireratuko zen ametsari haize egin guran.

Ondoren, loredietan ezkutatzen ziren udaberriko etorreraren zain, harik eta hosto gainetan, tximeleta, erle, gehi beste zenbait zomorro-jende pausatzen zen arte, liliei dantza zezaten eske.

Horregatik omen dira euri tantak udaran epel. Neguan ez, neguan tantak hotz hotzak dira, batzuetan, eta txuriak, zeinak zeru gainetik hegan jaisten direla ematen du, pinpilinpauxa txiki txuriak bailiran eta… elur deitzen zaio auskalo zergatik.

Eta guk dakiguna da, maite zaitugula dakigula, eta aireratzen diren sentimenduak ametsetan gora, jolastuko dira gaur, zuretzat, tximeleta izatera.

# Igel bat

Igel bat oroitzen dudan bakoitzean iruditzen zait…berek asmatu zutela ispilua, uretara jauzten ziren bakoitzean bi zeudelako ustea kendu ahal izateko. Eta nik, batzuetan, ziegakoa estaltzen dut zapi batez, bakardade bila nabilenean. Baina gero, amatxo aurkitzen dut bihotzean, eta Haizea, haren lepotik zintzilik, eta Haizea ere, bihotzean.

Orduan, ispilua estaltzen duen zapia erortzen da lurrera. Igela neguko hotzetik babesteko edo *maite zaituztedalako*.

## Gure udaberrian

Gure udaberrian
ez du ernaltzen erleak lorerik
ez du hegaldian zulatzen zuhaitz-tantai lerdenen
itzal arrastorik.

Harresian gora igandea
arantzadun laharrak
altzairuzkoak dira, hemen,
pujaberritzen duten
landare bakarrak.
Gure udaberrian.

Eta hostoak paperezkoak,
hostoak gurean,
bertan maite-gordina hitzez
janzten dugunean.

Dakigun arren
bortxaz biluzten dituztela
gure sentimenduak,
eta geldi,
orbeldu daitezen
denbora gordean.

Ausaz horrela
euskaldunon izatea
mendratzen delakoan.

Ausaz, ur-negar bat baino
ez dena ibaia,
mendi magalean,
itsasoratzen da gero.

. . .

Garaiz helduko ote zunan
urteroko hitzordura,
umatutako txoria
naturaren obran.

Alai lotuko zutela
belarra bezain zorura
edertzen dutena goiza,
frutondoak loran!

Oroitza dun sentitzea
irautearen hegia
ez izate deslaitua
doi bat denbora premian.

Esadan izan, badela,
hesituraz haraindian,
erleek ernaltzen duten
hostodun udaberri bat.

. . .

Arratsaren hondarretan
txori-kumeak airera,
harago hegatzen duten
txio-txio sentibera
entzunez ziegara noa
amatxorekin batera.
(Eurak hori dute "maite
zaitut" esateko era)
Goiza piztu den lekura
arratsaldean atzera
goxo garraiatzen degu
bi-bion arteko zera:
alabaren jolasgura,
amatasunaren xera…
gero, gaueko hamarretan
lotara etzaten gera.

. . .

Hurbil negua
usaintzen du goizean
arbola zahar
adarsoildu hark.

Hostoak aske
amesten du udazkena
gero lurreratu gabe.

Txoriei goiza
entzuten, zeinak leiak,
sentimenduak
hegatuz airean.
Presoak bere
ez izatea dauka
libre eremu
antzeztu batean.

. . .

Argitzal bat
nahiko hunan
oinutsetan laztandu
belar-hosto bakoitza
maitekor hitzez, gurtu.

Ametsik gabeko loa,
egunsentian samin;
bidai zapuztu!

Izarrak zintzilik gauez
larre-barrutira-eta,
oreinak orrazten Mari
leize atarian.
Ilargia pausatu da,
esaidan:
maitasuna goizalban
zergatik ez hurren.

Esaidan!

Murumendiko dama.

…

Bidertzeko laharrak
lore bihurtzen dituzten
ureztatutako ametsak;

Paperezko hostoetan.

Eta gero…
gero, gure izatea
libreagoa dadinean.

## Zoriontasuna elur zen

**In the oldest**
**Language of Europe**
**Water is Ur**
**Earth is Lur**
**Snow is Elur**

Lasaitzen nau.
Neure baitarakotzen nau.
Paisaia zuri, mutu, gardentasunezko hotz
Basamortuko dunak legez,
gelez.
Urbasako zuritasun lehortua,
lehertua
Inoiz ikusi elurterik elurteena
aitaren 131 Supermirafiori zuri hartan
ume ginen, *fido* ginen
elurretan irudiak egin, ikonoak zertu
malutak maluta laztanduz
bat bera ere ez da berdin, denak dira desberdin
zuri, blai, garbi
kotxean arropak lehortu
txistorra frijitua aterpetxean,
sutondoan txinpartak amestuz
Lizarrara jaitsi
Olentzero handik zetorren
Bere zaldi hegodun eta astoarekin
Ume ginen
Zoriontasuna elur zen.
Mara-mara dario Long Lartinen
Laket dut baina ez naiz zoriontsu;
Ezin gara patiora irten.

## Zirrikitu

Espetxeko zirrikitu batetik
Ilargia ikusi dut.
Gela txiki, itxi batetako
Leiho barrotedunez gaindi
Juxtu-juxtu
Nahi gabe
Ilargia ikusi dut

*Rise above the waws*
*The folly of end less fight,*
*Let´s try making love*
*Let´s make our popppies white*
***By Benjamin Zephaniah***

## “Ongi etorri” ¿quiere decir Alfombra?

*Lankide bi kotxean doaz, Donostian:*

- *Mira en esa casa vive Mikel Laboa…*
- *No le conozco… trabaja en nuestra empresa?*
  *(pasadizo erreala)*

*Hola, me llamo Jose Antonio (Josean) Bermudez Molina; nací en Barakaldo en 1970.*

Kaixo, Harkaitz Badionla Solabarrieta naiz eta Ondarroan jaio nintzen 1970an.

*Los Bermudez vinieron de Extremadura cuando mi padre era un chaval; los Molina vinieron de la zona de Murcia cuando mi madre tenía 10 años. Yo nací aquí en Barakaldo, en el hospital de Cruces, y soy de la Margen Izquierda de pura cepa. Y del Athletic.*

Nire gurasoen familia biak ondarrutarrak dira betidanik; Badiolatarren adarreko desizena “Armentxanekuk” da ta Solabarrietatarrena “Urkixunekuk”; herriko familia guztiek dute goitizenen bat kostaldeko herrietan. Neroni Bilboko ospitale baten jaio nintzen, Gurutzetan uste dut, baina noski ondarrutarra naiz. Gurasoei kostatu zitzaien nire izena jartzea, dena zen oztopo funtzionario erdaldunengandik.

*La familia de mi padre viene de una fuerte tradición socialista extremeña y siempre hemos tenido como referencia a la UGT en el plano sindical y al PSOE ( PSE, aquí) en el político.*

*Los Molina siempre han sido más apolíticos, gente que no se complica la vida y bastante tiene con los problemas diarios, pero mi padre (QEPD) solía comentar que "Molina el viejo" era "un poco fachilla". Pero buena gente.*

Gure aita zena eta bere anaia guztiak arrantzaleak izan ziren, ikasketa gutxi eta kresal askoko jendea; politikan sartzen ez zirenak. Amaren adarra, ordea, oso abertzalea izan da beti, herriko erreferentzia bat azken hamarkadetako borroka politikoan; nik, azken horretatik edan dut batik bat.

*Barakaldo es una ciudad pequeña de la Margen Izquierda del Nervión, está situado en el Gran Bilbao y es uno de los núcleos referenciales de Vizcaya. El BEC está aquí pero tenemos una tasa de paro superior a la de Euskadi. Aquí ha habido una gran tradición industrial y naviera. Nuestras referencias son Pablo Iglesias, La Pasionaria, Nicolas Redondo, Felipe Gonzalez, Jose Luis Corcuera o Patxi Lopez. La mitad del pueblo vota socialista y la otra mitad, más o menos, nacionalista.*

Ondarroa Bizkaiko kostaldeko herri euskalduna da, hamar mila biztanle ditu eta historikoki herri arrantzalea izan da. Langabezitasa oso baxua izan da iraganean eta orain dexente igo da krisiarekin. Lea Artibai, Hegoaldeko eskualderik euskaldunena da eta horrek nortasun zehatza ematen dio inguruari. Oraintsu arte nahiko isolaturik egon gara, hemen ez baitago autopista edota trenbiderik. Herriaren erdiak PNVri ematen dio botoa eta beste erdiak, Ezker Abertzaleari; garaian garaiko egoeren arabera indar batek edo besteak lortzen du alkatetza. Gure erreferentziak dira Jose Antonio Agirre, Telesforo Monzon, Txillardegi, Argala, Txomin, Santi Brouard, Jon Idigoras edotaArnaldo Otegi.

*De pequeño me acuerdo que frecuentábamos el Centro Extremeño de Barakaldo y me hacían tomar parte en actividades culturales. Aparte de eso me acuerdo comprando pipas, comiéndolas en los bancos de la plaza con los amigos y yendo al cine a ver pelis como E.T., Superman y La Guerra de las Galaxias. Y alguna vez subiendo el monte Serantes, el Pagasarri o el Ganecogorta.*

Txikitan gurasoek euskal dantzetan sartu ninduten herriko beste ume guztiak bezala, hiru dantza-talde zeuden, pentsa! Horrez gain, ondo gogoan dut pipak erosi eta Alamedako bankuetan haiek jaten lagunekin, eta zinera joaten La Guerra de las Galaxias, E.T. edota Superman bezalako filmak ikusteko (zinea da herriko toki bakanetarikoa non ama-hizkuntza atean uzten duzun- umetan elebakarrak gara hemen eta 10-12 bat urtekin hasten gara gaztelera *txapurreatzen*). Noizean behin Tontorramendira igo edota Mendexara joanez, oinez, gero Lekeitiora jaisteko, hori dut gogoan.

*Cursé Primaria en la escuela pública del pueblo y despues Secundaria en el instituto del mismo Barakaldo. Despues hice mi carrera universitaria en Lejona, en la Facultad de Periodismo. Cuando yo estaba estudiando en el pueblo casi todos lo haciamos en castellano (entonces no había modelos) y una pequeña minoría en vasco; ahora se que es al reves y una mayoría de los crios estudia en modelo B o D y el A (solo en castellano) esta a punto de desaparecer, lo cual me parece un poco triste. Aparte de la escuela pública, en el pueblo hay otras dos escuelas pero para mí son excluyentes: la privada/religiosa a la que van los ricos (y por tanto excluye economicamente) y la ikastola donde van aquellos que quieren estudiar solo en vasco ( y por tanto excluye por la lengua).*

Lehen Hezkuntza herriko ikastolan egin nuen, gurasoen artean batutako diruarekin eraikitako ikastolan, euskara hutsean, frankopean ilegalki hasia. Bigarren Hezkuntza herriko institutuan burutu nuen, D ereduan, eta unibertsitate karrera Leioan egin nuen, Kazetaritza Fakultatean, dena euskaraz. Gogoan dut institutuko lehen urtean gure ikasgela zela euskarazko bakarra baina bost urte beranduago, azken urtean nengoela, argazkiak buelta eman zuen eta lehen mailako talde guztiak euskaraz ziren, bakarra izan ezik. Hezkuntza errealitatea, errealitate sozialera egokitu zen, azkenean. Ikastolaz gain herrian beste eskola bi daude: publikoa, zeina gaztelerararen gotorlekua izatetik D ereduan funtzionatzera pasatu den, eta mojena; azken hau itxi zuten (gaztelera hutsez zen, soilik neskena eta uniformea zerabilten- denbora kontua zen hura desagertzea).

*Mi cuadrilla estaba compuesta por amigos de Barakaldo mismo y alguno de Sestao, casi todos hijos de socialistas, menos alguno que era de familia pepera y un par de familias nacionalistas, pero moderados; estos últimos sabían hablar euskera porque habían estudiado en la ikastola. El periódico que se ha leído en Barakaldo de siempre ha sido* El Correo, *más que nada porque es apolítico y tiene mucha información local y deporte. Según crecimos, alguno se pasó a* El Mundo *y hay alguno que ahora compra* La Razón *desde que los de la* kaleborroka *le quemaron (por accidente, dicen), la tienda. Yo ahora leo* El País *por salir del localismo y tener una visión más nacional y cosmopolita.*

Gure koadrilako guztiok herrikoak ginen, denok euskaldunak, etorkinen seme bat izan ezik; hargatik sarri-sarri koadrila osoak gazteleraz egiten genuen. Ikasketekin ez zuen jarraitu lagun hark

eta lanean hasi zenean Espainiara joan zen eta ordundik euskara hutsez egiten da koadrilan. Gure koadrilan denok gara euskaltzaleak eta abertzale independentistak, pikoloekin errepide-kontroletan izandako hainbat esperientzik gure determinazio politikoa berrestu besterik ez du egin. Umea nintzenean etxean *El Correo Español* irakurtzen zen baina *Egin* sortu zen egunetik hura erosten genuen; hura itxi zutenetik *Gara* da gure etxeetako egunkari ohikoa. *Euskaldunon Egunkaria* sortu zenetik erosten nuen eta hura itxi zutenetik *Berria* da nire ohiko egunkaria. Bi egunkariak herritarren laguntzari esker sortu ziren, ez enpresa handien diruarekin.

*Mis referencias musicales son las normales para uno de mi edad: mis padres eran de Julio Iglesias, Camilo Sesto, Manolo Escobar y Mocedades. Yo escuchaba a los Baron Rojo, Obus y Leño primero, y algo de Barricada por un tiempo, junto con todo el movimiento tecno de la Movida Madrileña y después Maná, Enrique Iglesias y cosas así. Más las referencias internacionales: Los Rolling, U2, Michael Jackson, Beatles, etc. En literatura, tampoco es que lea mucho, pues Arturo Perez-Reverte y una de aquí que está bastante bien, Toti Martinez de Lezea; en el insti me lei a nuestros clásicos: Calderon, Becquer, Rosalía de Castro, Camilo Jose Cela, incluso nuestra aportación más grande a la literatura universal, El Quijote. No sigo mucho el teatro o la pintura. En escultura Chillida es un español universal y Oteiza era muy bueno pero tenía tintes nacionalistas, un poco cerrado de ideología. Estoy muy interesado en nuevas tecnologías de la información.*

Gure gurasoen musika erreferentziak pixkat xelebreak ziren niretzat, kantari espainiar asko entzuten zutelako gaztetan (euskal musika debekatua zegoen); gero badakit *Mocedades*- eta entzuten zutela eta Ez Dok Hamairurekin euskal musika modernoaren boom-a etorri zen: Mikel Laboa, Benito Lertxundi, Xabier Lete, Lourdes Iriondo, edota Errobiren lehen rock euskalduna. Nire aldetik britainiar heavy metala alde batetik eta EH osoan hain bogan zegoen RRVko taldeak: Kortatu, La Polla; Hertzainak, Zarama, RIP, Barricada edota Itoiz-en pop euskalduna. Ruper Ordorika be oso gogoko izan dut beti. Literaturan, institutuan klasiko espainiar mordoa irakurri behar izan nituen, aginduz, eta gustuko perla batzuk be aurkitu nituen(CJC edo Larra, adibidez). Gure literaturako klasikoak irakurtzera be derrigortu gintuzten: Axular, Aitzol, Mogel; Lizardi eta abar. Literatura modernoa pixkat gehiago jarraitzen dut: Atxaga, Izagirre, Sarri, Montoia, Cano edota herrikide dudan Uribe, besteak beste. Antzerkia apenas jarraitzen dudan. Pinturan Zumeta datorkit burura, eta eskulturan Txillida eta Oteiza, biak ikusgarriak. Sare sozialen fenomenoa ikaragarri gustatzen zait eta interneta aukera handi bat da gurea bezalako hizkuntza txikientzako.

*Trabajo de administrativo en un municipio de Cantabria, está bastante cerca y el trabajo no es muy difícil, estoy muy contento. Intenté encontrar trabajo en la CAV e inclusive tuve algunas entrevistas pero en bastantes de ellas, sobre todo en Guipuzcoa, pedían euskera- lo cual no lo encuentro muy lógico.*

Gipuzkoako herri ertain eta euskaldun batean nago lanean, udaletxean; kazetari gisa lanik apenas zegoen eta azkenean euskara teknikari dihardut, gehi udaleko komunikazio atala daramat baina

azken honek ez du lan handirik ematen. Pozik nago, giro ona dago eta udala oraintsu UEMAN sartu da beraz, gutxika-gutxika, gure jarduera osoa euskaraz egin nahi dugu, horixe baita herritarren gehiengo zabalaren ama-hizkuntza. Baina badakigu dexenteko arazoak izango ditugula Espainiako gobernuarengandik.

*Mi pareja de toda la vida, Vanessa, es la madre de mis dos hijos y estamos muy contentos. Ella es de Sestao pero aun así nos llevamos bien ☺. Pero el alquiler es bastante caro en Barakaldo (por ahora ni nos proponemos comprar casa) y estamos considerando seriamente movernos al pueblo de Cantabria en el que trabajo. El pueblo es mucho más pequeño pero el ambiente es parecido al de Barakaldo, no hay tanta diferencia. Los niños están matriculados en la misma escuela pública de Barakaldo en la que estudié yo; yo quería matricularlos en el modelo A pero mi esposa, mucho más pragmática, me hizo ver que está bien que los críos sepan algo de euskera para tener más posibilidades de trabajo en el futuro, oseaque accedí y están en el modelo B. De vacaciones normalmente vamos a Castro Urdiales, cercano y bonito. Tenemos bastantes amigos allí, varios de ellos Ertzainas que tuvieron que dejar Euskadi por la presión de los radicales en sus pueblos de origen.*

Nire bikotea, Amalur, Lekeitiarra da baina hala eta guztiz ere ondo konpontzen gara ☺. Mutiltxo bat dugu eta bigarrenaren zain gaude orain, oso pozik. Momentuz alokairuan gaude baina jada begia botea diogu herritik hurbil dagoen baserri zahar bati, hura berritu eta han bizitzeko- baina denbora eta dirua beharko dugu. Lan egiten dudan Gipuzkoako herria oso polita da eta nortasun handia dute, guk bezala, baina ni ondarrutarra naiz eta ez dut planteatu ere egiten beste nonbaitera joatea bizitzera, nahiago dut egunero joan-etorria egin errepidez la-

nera. Umea gure herri-ikastolan dago matrikulatua eta bigarrena ere hara joango da, zalantzarik gabe. Ikastolak dira Euskal Herri euskaldunaren zutabe nagusienetarikoa, guretzat estrategikoak dira gure hizkuntza desager ez dadin, eta guk sinesten dugun baloreetan hezi ditzaten umeak. Oporrak Lekunberriko kanpinean ematen ditugu, urtero. Giroa atsegina eta euskalduna da eta ingurumaria, oso oso polita. Euskal Herriko beste hainbat lekutakoak diren lagunak egin ditugu han, urteetan zehar.

*Estoy sindicado en la UGT y voto siempre al PSOE (menos alguna que otra vez que no he votado) pero no soy miembro de carnet como era mi padre- él era de la generación militante. De joven estaba formalmente en las juventudes del partido del pueblo pero era simbólico, estaba porque mi padre me inscribió. Hace años ayudé alguna que otra vez en campaña electoral pegando carteles y tal pero ya no lo hago, ahora lo hace una empresa profesional. En la margen izquierda normalmente ganamos nosotros, después viene el PNV y tanto el PP como los Batasunos tienen bolsas de votos pero son menores. Ahora la cosa está más tranquila pero en los años de plomo mi padre fue a más de un funeral de policías nacionales y guardias civiles, algunos vecinos nuestros; y después, de cargos de nuestro partido y del PP. Somos socialistas pero antes que eso somos demócratas osea que muchas veces nos juntamos con el PP porque los tenemos más cerca, por lo menos aquí en Euskadi; en el resto de España eso sería impensable. Los nacionalistas dicen que aquí hay "un conflicto" pero yo solo veo una banda de fanáticos matando con excusas políticas. Si fuera por ellos nos impondrían el euskera a todos, lo que no sería nada democrático, digo yo. Pero todo el follón es bastante complicado y algunas cosas, como el GAL, no son justificables, eso lo tengo claro- pero mi padre decía que había que entender la presión con la que vivían los policías en los 70 y 80.*

Gure etxean eta nire inguruko lagun ia guztiek betidanik Herri Batasunari bozkatzen genion eta gero Batasuna, EH, EHAK, orain Bildu, Sortu,… izena gutxiengoa da, guk independentista bozkatzen dugu. Ez nago sindikatuta baina izena ematekotan noski LABen emango nuke; egia esan, azken urteetan (1997ko "Gernikazotik" esango nuke nik) ELA ere nerbio sindikal eta politiko nahiko ona erakusten ari da. Zorionez ELA eta LABen artean gehiengo sindikala dugu Hego Euskal Herrian; Bilduk Gipuzkoako Diputazioan agintzen du eta herrietan zinegotzi zein alkate gehien duen koalizioa da, benetan harro egotekoa. Borroka armatua betirako desaktibatu da baina espainiarren indarkeriak hor darrai: errepideetako polizi-kontrolak, espioitza politikoa eta soziala; atxiloketak; bandera espainiarrak jarrarazi herri erabat euskaldunetan, probokazio gisa; euskara ezin da erabili Osakidetza edota ertzainekin… eta herriko hilerrian dozena erdi ikurrin daude, gatazka politikoaren ondorioz hildakoena. Biktimei buruz eztabaidatu nahi badute, datozela Ondarroara. Guk lehen bezala jarraitzen dugu, espainiarrak dira gurean gozo bizi direnak. Dena ezin da justifikatu, bistan da, eta akatsak egin izan dira urtetan zehar baina galdera da ea hemen zergatik gauden, mendeetan zehar, gatazkan espainiar eta frantsesekin: gure herri nortasuna ukatzen digutelako, besterik gabe. Ez gara gu euskara, ikurrina eta gure legeak inposatzen ari garenak Cuencan edo Montpellier-en, alderantziz da.

*Estuve una vez en Ondarroa, cuando les estaba enseñando la costa vizcaína a unos amigos de Madrid. Paramos porque uno de ellos necesitaba el baño y aprovechamos para tomar un café. Enseguida me llamó la atención que todo el mundo hablaba euskera y por tanto no les entendíamos nada. Sabía que la alcaldía era de Batasuna. En el bar donde tomamos café nos miraron de arriba abajo*

*nada más entrar, pero después ya no tuvimos ningún problema. El camarero nos entró en euskera. Después dimos una vuelta y me quedé que en el ayuntamiento ondeaba solo la ikurriña, lo que es ilegal. El pueblo está lleno de pintadas y carteles, pero la playa y el puerto están bien. Era un lugar que me dio malas vibraciones, no viviría allí.*

Behin izan naiz Barakaldon, gazteak ginen eta bertako jaietan bukatu genuen , ez bereziki jaietan interesatuak geundelako baizik eta gutako batek hango neska bati begia botea ziolako. Kalean barrena behin ere ez genuen entzun inor euskaraz berbetan, eta ia gau osoa eman genuen txoznetan ere, batzuetan, gazteleraz eskatu behar izaten genituen tragoak, lotsagarria. Herria oso itsusia eta itoa iruditu zitzaidan, erdi hutsik dagoen gune industrial ohia, toki tristea. Ez nuen euskal herri bat bezala identifikatzen, Espainian nengoela zirudien, batik bat udaletxean eskegita zegoen *piperpotoa* ikusi ostean… Eta lasai asko zegoen han, inor ez zen harritzen, soilik gu. Beste mundu bat, ez nirea; ez noa hara ezta ordainduta ere.



**Teresa Toda Iglesia**
1950
Porto Alegre (Brasil)

Atxilotxe data: 2007.12.01.
2013ko azarotik ASKE!

## EGIN, dentro y fuera

De las poquísimas cosas ciertas que se dijeron por parte de las acusaciones durante el juicio del 18/98, donde apuntillaron al previamente sentenciado Egin, fue que el periódico tenia un vínculo especial con EPPK. Pues sí, así era, y merece la pena recordarlo -¡y reivindicarlo!- cuando van a cumplirse 15 años de su cierre-ejecución.

Pero no se trataba de esa relación tenebrosa, delictiva, cuasi-orgánica que describía el fiscal, sino de una telaraña irrompible que contribuía a sobrepasar el aislamiento en que querían mantener a presos y presas vascas. Se trataba de informar de lo que sucedía en otras cárceles, en las calles, en Euskal Herria, en el mundo en general, desde una óptica más cercana y compartida, diferenciada del resto de los escasos medios (hoy son muchos más, pero uniformes en lo que a estos temas atañe), que circulaban por patios y txabolos.

Información general que, en una etapa, se quiso hacer más proxima con las ediciones locales, osado proyecto que costó sacar adelante. Pero ¡qué digo! Las ediciones locales no podían llegar a presas y presos según su lugar de procedencia: los ejemplares de Egin que se enviaban a puntos del Estado español, incluídas las cárceles, eran los primeros que salían de la rotativa, para llegar a tiempo a aviones y trenes nocturnos. Por lo tanto, llevaban la primera edición local que se imprimía.

Supongo que actualmente, en las rotativas, la automatización y los ordenadores hacen que todo sea rápido y limpio, pero en la década de los 90 y con la rotativa que teníamos, cambiar las "planchas" para cada edición local llevaba su tiempo e implicaba riesgo de atasco de papel u otras incidencias técnicas. ¡Un homenaje merecen los equipos de rotativa, capaces de resolver imaginativamente cualquier problema!

La información concreta de prisiones, muchas veces de gran dureza, tenía un vivo contrapunto con la frescura de los Merkatu Txikiak, donde la torva mirada fiscal buscó, en vano, todo tipo de tropelías y consignas. Pero sí es cierto que muchos "Merkatus" transmitían mensajes semi-cifrados... sobre lignes, noticias caseras, relaciones personales, saludos, bromas entre amigas y amigos de cuadrillas, del pueblo, del mako... fué, sin duda, una de las secciones más leídas y comentadas de Egin, dentro y fuera de las cárceles.

En nuestro Egin, por haber, hubo hasta torneos de ajedrez intercarcelarios. Si de por sí una partida ajedrecística puede alargarse, ¡qué decir de éstas, sometidos los movimientos de ficha a todas las visicitudes de una carta carcelaria! Alguna, alguno de quienes participaron quizá recuerde si llegó a haber ganadores o si el campeonato quedó interrumpido por el acentuamiento de la dispersión o por el persianazo garzonita.

Con todo, el objetivo fundamental de la información sobre cárceles y EPPK era sacar a la calle lo que sucedía intramuros, denunciar las cada vez más duras políticas aplicadas al Colectivo y familiares; las agresiones, las respuestas, las luchas. Contar lo que no se contaba.

Me es difícil separar mis vivencias personales de esta crónica sobre Egin. Me ha tocado vivir la experiencia a ambos lados de los muros, como persona y con mi mirada de periodista. Desde mi trabajo como corresponsal en Madrid cubrí muchísima información que, desgraciadamente, desembocaba en las cárceles: detenciones, denuncias de torturas, declaraciones en la Audiencia Nacional, prisión provisional, jucios, sentencias. Empecé a mediados de los 80... y es escalofriante constatar que personas de cuya detención y juicios di noticia entonces sigue aún encarceladas, aherrojadas por una legislación retorcida en busca de venganza.

Acompañé a las primeras y masivas marchas a Herrera de la Mancha; contamos los primeros pasos de la dispersión y los fríos "razonamientos" con los que la justificaron PSOE y PNV; narramos huelgas de hambre y borrokas, palizas, muertes terribles entre rejas y las largas caravanas de dolor regresando a Euskal Herria. También alegrías, como salidas en libertad.

Hubo hueco en las páginas de Egin, asimismo, para la situación de tantos presos y presas sociales atrapados casi sin remedio por la droga y, sobre todo, para la lucha desde fuera de personas y organizaciones contra ese desamparo, denunciando a la vez a todo el entramado carcelario.

Egin abrió un camino, marcó pautas. Hacíamos esfuerzos por mantener claros los márgenes entre información y opinión; dar la nuestra, nuestra opinión, y transmitir bien la de los demás, protagonistas directas o colaterales de las noticias.

Nos equivocábamos en ocasiones, metíamos la pata, la cagábamos, ¡quién no! No era fácil controlar todos los datos a última hora o contrastar en minutos hasta el fondo. Cuando ocurría algo de eso, ¡uf, qué lío! ¡Qué broncas telefónicas podía llegar a haber! Después, intensos debates, aclaraciones. Es lo que tiene un estilo de periodismo que se pega a sus bases y se abre a sus lectoras y protagonistas.

Hoy, desde "dentro", capto con ojos más curtidos las razones de algunas de aquellas quejas. Comparto con cientos de compañeros y compañeras las inquietudes de la dispersión; la indignación, la rabia ante las noticias fragmentadas y manipuladas que inundan el txabolo en cuanto enciendes la tele o la radio y hablan de Euskal Herria; la firmeza colectiva frente a tanto abuso y crueldad alimentadas por quienes quieren congelar nuestros derechos, sueños y esperanzas.

Escribiría muchas crónicas directas y diversas de la vida y la lucha en los makos -pero Egin ya no está. Aunque no por eso callemos hasta contar, cuando y como sea, que la marea ha cambiado, que cada ola abre una nueva puerta, que van saliendo compañeras y compañeros, una tras otro, otro tras una, hasta llenar todos los huecos vacíos en tantas casas de Euskal Herria. Y todas las páginas de un "Egin" único, especial y... libre.



**Xabier Aranburu Muguruza**
1962
Usurbil

Atxilotze data: 1991. urtean.



C.P. Herrera de la Mancha
Apdo. 77
13200 Manzanares
Ciudad Real

## Zapalkuntzaren ikurra

**Doinua: “Mundu honetan holako gauzak”**

1
Demokraziaz mozorrotuta
dator agindu makurra
abertzalego guztiarengan
eragin nahian beldurra
bana gelditzen baldin bazaigu
identitate apurra
udaletxean ezta jarriko
zapalkuntzaren ikurra:
oletan utzi zuena
Euskal Herriaren lurra.

2
Bai abertzale eskubitarra
bai abertzale ezkertar
inposaketa honen aurrean
gabiltz ezin hartuz elkar
zorigaiztoko ondorioak
eginarazten du negar:
piper-potoa udaletxean
zintzilik ikusi behar.
Euskal Herria ez ote dugu
dagoeneko hiltzear.

3
Ezin hobeto atera zaie
prestaturiko kanpaina
zatitutako abertzaleoi
erraz harturik tamaina
begien bistan jarri digute
hamaikagarren azaña:
balkoitik dantzan umilazio
iraina eta destaina
Euskal Herria bihurtu nahirik
derrigorrean España.

4
Madril aldetik etorri denez
agindu zakar lehorra
ikurrinari omenaldia
egitea da baikorra
adabakia jarrita baina
ezingo ditugu izorra
arazoaren konponbidea
izateko eraginkorra
abertzaleok behar baitugu
intsumisioa jorra.

5
Udaletxean begiztaturik
dantzari ikur arrotza
bihotz osora azkar sartu zait
amorru zizta zorrotza
begietara malkoak datoz
negarraren zotin hotsa
trapu horretan ikusten baitut
zapalkuntza eta bortxa
hau da indarrez herri txikiei
ezarritako morrontza.

6
Euskal Herria espainiartzen
segitzen duten honetan
abertzaleok itsu darraigu
bandokide borroketan
gure herriaz noiz ote gara
maiteminduko benetan
burua sarri uzten baitugu
etsaiaren  eskuetan
horretarako aproposa den
Estatuaren Mekan.

7
Espainiako tiraniatik
Nola zapaltzen gaituzten
dekretuz eta zitalkeriaz
eskubideak deusezten
gure hizkuntza eta hezkuntza
euskaldun arima husten
dena murriztu edo ukatu
ez dute arnasten uzten
gatibutza hau noiz arte segi
beharko dugu irensten?

8
Zoritzarreko egoerari
ezin zaio gehio eutsi
abertzaleok gaur behar dugu
zatiketarekin hautsi
naziogintzan irmotasunez
prestutasuna erakutsi
estrategia bateratu bat
bide-orri eta guzi
zauritutako Euskal Herria
ez dezagun hiltzen utzi.



**Gorka Lupiañez Mintegi**
1980
Durango

Atxilotze data: 2007ko abenduak 6.



C.P. Curtis-Teixeiro
Carretera de Paradela s/n
15310 Curtis
A Coruña



**Iñigo Elizegi Erbiti**
1971
Goizueta

Atxiloketa data: 2004ko apirilak 17an.



Saint Maur - Maison Centrale
Bel Air
36.250 Saint Maur Cédex
Frantzia



**Mikel Zarrabe Elkoroiribe**
1959
Eibar

Atxilotze data: 1989. urtean.



C.P. Teruel
Avenida de Zaragoza, 26
44001 Teruel



**Joseba Galarraga Arrona**
1959
Deba

Atxilotze data: 1999. urtean.



C.P. Valladolid
Ctra. Adanero - Gijon, km. 94
47011 Villanubla
Valladolid



**Itziar Moreno Martinez**
Bilbo
1982

Atxilotze data: 2011.4.10.



Fresnes - Maison d´arrêt
3, Allée des Thuyas
94.261 Fesnes Cédex
Frantzia




ASKATASUN ERREZETA.

GALDERA: ¿ZER IKUSIA DAUKATE KALKULO GEOMETRIKOEK, TRISAK, ASTE NAGUSIAK ETA MITARD-OK??







TXIS GALDERA.



KIPULARI AIZTOA. 12 x 9 zm.

*Kipulari aiztoa sartu*
*geruzaz geruza*
*negar arteko barreak*
*geruzaz geruza*
*odolezko malkoak*
*geruzaz geruza*
*finean, bihotza eta aiztoa, besterik ez.*



**Josu Bravo Maestrojuan**
1959
Tafalla

Atxilotze data: 2003. urtean.



C.P. A Lama
Monte Racelo, s/n
36.830 A Lama
Pontevedra



**Jon Aingeru Otxoantezana Badiola, *Kirru***
1954
Ondarroa

Atxilotze data: 2002.



Poissy - Maison Centrale
17, Rue de l´Abbaye
78303 Poissy Cédex
Frantzia



**Txomin Troitiño Arranz**
1955
Donostia

Atxilotze data: 1987. urtean.
2013ko azaroak 08tik ASKE!



**ANJEL FIGEROA FERNANDEZ**
Algorta 1972.12.06
Algorta 2013.03.14



**XABIER LOPEZ PEÑA**
Galdakao 1958.05.30
Paris 2013.03.30.

## Ametsak

Zerua begiratzea atsegin dut.
Zerua niretzat askatasuna da,
Barrote eta harresirik gabe ikusten dudana.
Zerua natura da ere: polita, erakargarria, basatia, ...
Baina zerua hodeitsua denean, eta gutxinaka
hodeiak formak aldatzen dituztenean,
neure ametsak zeruan irudikatzeari ekiten diot:
Euskal Herriko mendiak ikusten ditut,
itsasoaren olatu indartsuak,...
eta gehienbat maite dudan jendea ikusten dut,
pozez mozkorturik, dantzatzen, abesten, begiak dir-dir
egiten dietela: guztiak zoriontsu geure herriaren
askatasuna eta geure askatasuna ospatzen,
Euskal Herri aske eta gizatiarrago batean.
Guztiak ametsen militanteak bihurtuta,
ametsak egia bihurtuz biziz.
Eta ni haiekin bat.

**Anjel Figeroa** (Atarамiñe‘04)

